

Oroimenik gabe ez gara ezer, eta Herri bezala, oroimenik gabe ez gara inor. Eta garenaren zordunak gara, izatez, egin nahi duguna burutzeko. Herri libre guztiek borrokatzen dute aurrera begira, geroa baita askabiderako helmuga. Baina atzera begiratu gabe zaila da identifikatzea azken geltokia. Jatorritik bizi izandakoak, bidean utzitako pasadizoak, mugarriz mugarri egindako ibilbidearen kronika aintzakotzat hartzeak laguntzen gaitu, beti ere, azken portua topatzen. Askatasunaren eremuak baldin badu, bederen, behin betiko amarralekurik.

Atzera begiratu horretan, Euskal Herriak badu memoriaren arrailan koka daitezkeen jazoera ugari. Guztien artean, Igor Angulo eta Roberto Sainz euskal preso politikoen heriotzek utzi zuten samina eta erantzun sendoa aukeratu ditu Askatasunak oroimena astintzeko. Kronika liburu honetan jaso dira egun gogor haietako gertakizun asko. Ez guztiak, jakina. Lekukotasun anonimoak norberaren garunean betiko geratu baitira itsatsita.

Oroitzea irabaztea da. Oroimenik gabeko herriek zer galdu zuten ere ez dakitelako. Eta garaipena zor diegu irabazteko gehien jarri zutenenei.



Nire aita, munduko pertsonarik alaiena zen. Berarekin egotera joaten ginen bakoitzean, oso pasta gozoak ateratzen zizkigun. Berari asko gustatzen zitzaion kafea, baina ama eta biontzat beste kutiziak ekartzen zituen. Orain ez dago gure artean, baina bere maitasuna ez da desagertu. Izugarri maite gintuen ama eta ni, nahiz eta -nik uste- ni maite ninduela gehien... Baina apurtxo bat gehiago bakarrik, e? Ama ere asko-asko maite zuen eta.
Asko hartzen dut faltan berarekin egotea. Baina, halere, ez gaitu bakarrik utzi. Beti eramango dugu gurekin. Beti gogoratuko dugu bere irribarre politarekin eta argazkiak begiratuz estaliko dugu bere ausentzia. Beti izango gara hiru, eta suerte handikoa naiz, benetan... aitarik hoberena izatea tokatu zitzaidan eta.

Aitzol Muruaga Angulo



Beti egon ginen elkarrekin, hogeita bat urte hain zuzen ere. Eta oso erraza da niretzat definitzea. Rober, erresistentzia zalea zen. Erresistentziazale amorratua eta oso ezkertiarra. Graduadu soziala ikasi zuen, Euskaldunan lan egin zuen, LABeko militantea zen eta berak beti ezker kutsuko sentsibilitate oso bizia izan zuen. Metodikoa, kontsumo txoroaren aurkakoa, gehien eragin zion gertakizuna izan zen bere aita langabezian geratu zenekoa. Langilea eta langilegoa zen bere pasioa, borroka grina eta pasio iturri nagusia. Portugaleteko kaleak izan ziren gure eskola, eta Portuko Baru eta Ana bezala ezagutu gintuzten edonon. Militantzia xumean eman zituen urteak, eta harro bizi zen horretaz.

Ana Lopez

# Otsailak 27






IGOR ANGULO ITURRATE EUSKAL PRESO POLITIKOA HILDA AURKITU ZUTEN ESPETXEKO ZIEGAN. EUSKAL HERRITIK URRUNDUTA, EHUNKA KIDE BEZALA SAKABANATUTA, CUENCAKO KARTZELAREN HORMATZARREK DAKITE, EZ BESTE INORK, BERE HERIOTZAREN ZER-NOLAKOA.

Urkaturik agertu zela badakigu. 32 urte besterik ez zituela dakigun bezala. Proiektuak eta ametsak, etorkizunari begirako erronka ugari, Idoia eta Aitzol ondoan beti ere. Hori guztia badakigu, baina lehioko barroteetatik zintzilkaturik hiltzerainoko bidea egiteko Bitti bultzatu zuen arrazoia zein izan zen erantzuteke dago. Galdera ikur batez markaturiko demanda dugu oraindik orain.

Hala eta guztiz, espetxeak hil zuen Igor. Horren dudarik ez dago Euskal Herrian. Zalantza izipirik ez dago bere sorterrian, portuko kresala eta erdoilaren jira-bueltan bizitzen den Santurtzi herri borrokalarian. Espetxe politika ankerrak eraman zuen Igor, aurrenik beste hogeita hamabost preso eta senide hil zituen modu berean: inpunitatearen laratzean.

Gatazkaren konponbideaz hitz egiten ari zen, eta gatazkaren aurpegirik ilunenak esnarazi gintuen astelehen hartan, urteotan guztiotan kartzela politika sustengatu dutenen iratzargailuak ziztaturik. Konponbide demokratikoaren bidean urratsak eman nahian Herria, eta beste behin ere dispertsioaren zartakoak lohitu zuen haren ametsa. Itzulera amesgaizto bilakatu zen. Cuencatik Santurtzirako bidaia, heriotza zigorraren zorduna izan zen eta.

Halakoetan, tarte gutxi geratzen da gogoeta politikoak arretaz entzun daitezen. Erraiek agintzen dute, eta sentimenduetan kiribiltzen da garrantzitsuena: Igorrenganako maitasuna, borrokalari nekaezinarentzako

omenaldia.

Dolu laino batek estali zuen Ezkerralde osoa albistea jaso orduko. Ezagutu zutenen irudiz itsas-gizona zen Igor, gaztetatik arrantzan ibilia. Eta itsadarraren ertz horretan ontzietako kulunkak markatzen ditu familiak, sendotzen ditu harremanak eta bertebratzen du bizitza soziala. Inork ez zion bizkarrik eman minari, norberaren ideolojia eta lerrokatzea zein zen kontuan izan gabe.

Ilunabarrean, Santurtziko plazan biltzen hasia zegoen jendea. Apurka apurka, ikurrinak lehioetan eta kartelak nonahi. Xingoladunak banderak, omenezkoak eta amorruzkoak kartelak eta lehen erreakzioak. Izan ere, errabia ez diote lapurtuko Euskal Herriari, ez behintzat mendeku goseak eta

**Inork ez zion bizkarrik eman minari, norberaren ideolojia eta lerrokatzea zein zen kontuan izan gabe**






presoen erabilera politikoak gobernuen ihardun lerroa gidatzen duten bitartean.

Cuenca-ko beilategira zuzendu genuen begirada hurrengo orduetan. Bertan, 18/98 auziko auzipetuek salatu zuten Igorren heriotza. Elkartasuna da zapalduen arteko identitate ikurra, eta haien arnas beroak itzali zuen ergeltasunaren sugarra: ordu batzuk lehenago Daniel Portero ultraeskuindarrak sagardo botila batez saiatu zen Igorren heriotza ospatzen. Txema Matanzas auzipetuak, santurtziarra bera ere, zapuztu zuen Espainia Beltzaren topa iraingarria. Beti pazientziaz jardungo gatzaizkie?

Anartean, milaka pertsona atera ziren Euskal Herriko kaleetara. Igor, gogoan zaitugu, edota Herriak ez du barkatuko leloek eztarriak urratzen zituzten. Santurtzin, inauteri goibeleko markoan utzi zuten jendea biltzen. Beste hamarka herritan, ordea, Barne Sailaren joaredunak zelatan zeuden, eta ez zaldi-isatsaz izpiritu txarrak uxatzeko, herritarren mina jipoitzeko baizik ■

**18/98 auziko auzipetuek salatu zuten Igorren heriotza. Elkartasuna da zapalduen arteko identitate ikurra eta haien arnas beroak itzali zuen ergeltasunaren sugarra**

# Otsailak 28



BEZPERAN, LEHEN ZAURITUAK ETA LEHEN ATXILOTUAK UTZI ZITUEN ERTZAINTZAREN INDARKERIAK. ETORRIKO ZENAREN AURREKARIA IZAN ZEN. POLITIKARI PROFESIONALAK BESTE ALDE BATERA BEGIRA ZEUDEN, BEZPERAN MUNGIAN ZARTARAZITAKO LEHERGAILU BATENGATIK GAITZESPEN INSTITUZIONALA ALBISTEGIEN GOIBURUAN JARTZEAREKIN ARDURATUA.

Herritarron kezka eta samina oso bestelakoa zen, jakina. Igorren senideek oso garbi zuten suizidioaren bertsioak zulo gehiegi zituela, gezur asko eta zalantza gehiago zeudela bertsio ofizialaren atzean. Hiltzeko politika da kartzeletakoa. Espetxe barruan ustel daitezen asmaturiko legeria eta tresneria indarrean egonda, preso batek bere buruaz beste egitea ez da kasualitatea. Helburu betea da.





Estatuen kartzela politikaren arrakasta.

Heriotza adierazpenak, heriotza desioak, heriotza politikak, heriotza egitasmoak, heriotza zigorrak, heriotza kartzelak eraiki ondoren, hipokriten txanda iristen ohi da. Orduan ere, PNV buru, PSOE, EA, IU, Aralar eta oso jite desberdineko bozeramalek eta ordezkarik ekin zioten bere lanari. Aho txikiarekin doluminak familiari, are txikiagoarekin heriotzaren nondik norakoak argitzeko ikerketa eskaerak eta, ozen bezain mehatxugarri, lehen mailako helburua zein zen filtratu zuen hiru probintzietako gobernuak: lasaitasuna.

Lasai arraio egongo ziren Lakuan. Lasai EITBko bulegoetan. Ezin lasaiago Arkauteko korridoreetan. PSOEren estratejiaren babeseskema errepasatzen zuten bitartean, ideiak oso garbi eta ordenatuak baitzeuzkaten Sabin-Etxeko jauntxoek. Barren leihotik oso ondo begiztatzen zuten hurrengo egunetako paisaia.





Kartzeletan ez ziren hitzetan geratu, nolabait esateko. Villena, Teruel, Huelva, Navalcarnero, Fresnes,...Gose grebak, plantoak, elkartaratzeak, afitxa jartzeak,... Bihotza zulatzen duen izotz-orratza da kide baten heriotza, eta zaila da arrazoizko bilakatu bere lojika partikularra, nahiz eta guztiek badakiten estatuen kartzela politikak hil nahi dituela. Euskal preso politikoen suntsitzea eginbehar zuzentzat daukaten kartzelariak baldin badaude, ez da harritzekoa borondatzeko hiltzaile lan horren ondorioa euskal

**Bihotza zulatzen duen izotz-orratza da kide baten heriotza, eta zaila da arrazoizko bilakatu bere lojika partikularra**





## Autopsiak ez zuen argia ekarri. Alderantziz, zalantza berriak sortu eta sendiaren ezinegona larriagotu zuen. Izan ere, gorpua mugitu zutela frogatuta geratu zen

preso baten heriotza izatea.

Eskarmentuz dakite dakitena. Eskarmentuz ekiten diote heriotzari bizia lehen lerroan jarriz.

Autopsiak ez zuen argia ekarri. Alderantziz, zalantza berriak sortu eta sendiaren ezinegona larriagotu zuen. Izan ere, gorpua mugitu zutela frogatuta geratu zen. Ustez bere buruaz beste egiteko erabilitako nylonezko lokarriak ez zituen baimenduak, beraz, inork ez daki nola agertu ziren bere ziegan. Eta horren guztiaren gainean, beste itzal adierazgarria: Igorren gorpua altxatzeko ardura izan zuen epailearen aktak ez zuen inolako zehaztasunik. Tramitezkoa zen, garrantzirik gabeko gertakizun arin baten laburpentxoa bailitzan.

Idoia Muruagak, bere neska-laguna, ez zion betarik ematen zalantzari: "Gure ustea oso argia da: hil egin dute". Autopsia amaitua, gorpua Euskal Herriratzea izango zen hurrengo pausoa. Inoiz imajinatzerik ez zegoen itzulera zuten zain: Azkarate, Balza eta Ibarretxeren lasaitasuna ■

# Martxoak 1






ESKU BELTZAREN" LANARI EGOZTEN ZAIO, ALDE BATETIK ZEIN BESTETIK, EUSKAL HERRIAN ETORKIZUN POLITIKO HOBEAGO BATEN ITXAROPENA ITZALTZERA DATOZEN GERTAEREN ARDURA. KASUALITATEAK EZ DU HORRENBESTEKO MARJENIK, ETA EZKUTUAN MANIPULATZEN DEN ERREALITATE GORDINAK ZALDIKO-MALDIKO ZORO BATEAN MURGILDU GAITU BEHIN BAINO GEHIAGOTAN. SAMINA ZEGOEN, LUZE-ZABAL, GURE HERRIKO KALEETAN IGOR ANGULOREN GORPUA CUENCATIK ZETORRELA, ETA ERREALITATE HORRETAN ERAGITEKO ESTRATEJIA ULERTEZIN BATEK ARE GEHIAGO AZTORATU BEHAR ZUEN, IZKINAREN BUELTAN, SANTURTZIARRAREN ITZULERA.

BAINA, BENETAN AL DA ULERTEZINA BALZA-PNVREN JOKABIDEA?

Altubeko peajearen pare dantzariak eta jende andana zegoen zain, Igorri azken agurra emateko aukera noiz eta nola izango. Ordurako ahoz aho zebilen zurrumurrua: "ez dute gorpua herrian sartzen utziko". Balzaren herrizaingo sailatik legezkotasunaren inguruko irakurketa zorrotza zein interesatua baliatuz, Igorren omenez egin zitekeen edozein ekitaldi "terrorismoaren gorespena" izango zela eman zen jakitera. Ondorioz, elizkizunak eta gisa bereko ekimen pribatu-familiarrak izan ezik, beste edozein errekonozimendu edo kale agerpena indarrez zapalduko zutela ohartarazi zuen Barne Sailak agiri zeken baten bitartez.

Araba eta Bizkaiko herrialdeak zeharkatzeko Ertzaintzaren presentzia eta markaje estua jasan behar izan zuten Igorren senideek, abokatuek eta lagunek. 1936. urteko

afusilatuek, Telesforo Monzonek, edota Joxi-Joxeanek antzerako ibilbidea egin behar izan zuten hil eta gero, hiltzaileen apeta asetzeko: kanposantuko hilobi hotza izan zedila beren itzuleraren lekuko isil bakarra. Horrela saiatu zen ezkutatzen PNV sakabanaketaren eta bere ondorioen emaitzetan duen erantzukizun handia. Zaurian piko eginez, hilerriko horma itxien arteko itzalean.

Euria ari zuen. Izua ari zuen. Cabieces auzuneko errotonda nagusian orduak itxaroten egon ondoren, ehunka lagun bildu ziren Santurtziko kanposantuaren inguruetan. Arropa bezain bustia zeukaten zauritua

**Samina zegoen, luze-zabal, gure Herriko kaleetan Igor Anguloren gorpua Cuencatik zetorrela**







1936. urteko afusilatuek, Telesforo Monzonek,
edota Joxi-Joxeanek antzerako ibilbidea egin behar izan zuten
hil eta gero, hiltzaileen apeta asetzeko




bihotza. Guardia Zibilak oztopatu ez zuen Joxe Angel Altzugurenen azken agurra gogoan, buruan ezin kabiturik zeuden Ertzaintzak zapaldu nahi izatea Igor Anguloren harrera, non, eta bere sorterrian!

Harridura eta amorrua korapilo beran, bertaratzen hasiak zeuden, kanposantura, bai herritarrak bai uniformedunak. Esku beltzak eta ukabilak aurrez aurre. Santurtziko kanposantua izan zen bertaratuen azken babeslekua, zipaioak argi utzi baitzuten gogor oldartuko liratekeela Igorren etorreran kalean egon zitekeen edozeinen aurka. Sorozabal-en martxa ezagunak busti zuen behin eta berriro jendetzaren animoa. Enegarren hasperen kolektiboa egiten ari zen Euskal Herria iluntzeko 6,00ak aldera.

Besoz beso, sorbaldaz sorbalda, emozioz emozio jardun zuen, zerraldo, Igorren gorpuak hilerriko kapelara iristeko bidean zehar. Krabelin gorriek txanda hartu zioten euriari, hilkutxa eta bidexkak estaltzeraino. Eta bertan, esku ahurrean jaso zuen bere





familiak herritarren hunkidura; ilaran jarrita, banan banan igaro ziren Igorren aurrean. Muxuak eta negarrak nahasten ziren bisaietan, hibai-orbainak bailiran.

Ia ordu berean EBBko bozeramaile den Iñigo Urkulluk "egoitza publiko batean indarkeriazko heriotza izaten denen beharrezkoa da azkenera arte ikertzea" adierazten zuen. Kalea ere leku publikoa da, ezin publikoago irudikatzerik, eta Ertzaintzaren errepresio basatia lasaitasun soziala eta legezkotasunaren izenean justifikatu zuten.

Su eta gar ibili zen Miren Azkarate egunean zehar doluaren kontra erabilitako biolentzia azaltzeko argudio egokiaren bila. Alferrik ordea. Asteazken hartan santurtziarren senean zegoen giza argudiobidea, Santurtziko kaleetan, euriak eta errepresioak astindutako abertzaleen urdail-ahoan ■

# Andoni TXASKO

PORTAVOZ DE LA ASOCIACIÓN DE LAS VÍCTIMAS DEL 3 DE MARZO

## "La preocupación y el compromiso para con el Colectivo de Presas y Presos debe estar latente todos y cada uno de los días"

PORTAVOZ DE LA ASOCIACIÓN DE LAS VÍCTIMAS DEL 3 DE MARZO. FUE GRAVEMENTE HERIDO POR LA POLICÍA ESPAÑOLA EN 1976, A CONSECUENCIA DE LO CUAL PERDIÓ LA VISIÓN DE UNO DE SUS OJOS. SINDICALISTA DE LARGA EXPERIENCIA EN ARABA, SIEMPRE SE HA DESTACADO POR SER SOLIDARIO CON LA CAUSA OBRERA Y CON LAS PERSONAS REPRESALIADAS. ESTA VIRTUD NO PASÓ DESAPERCIBIDA PARA LOS RESPONSABLES DE LA CONSEJERÍA DE INTERIOR Y DE LA ERTZAINTZA.




**Siendo portavoz de la asociación de las Víctimas del 3 de Marzo, este año sostuviste una ikurriña con crespón en la manifestación en homenaje a tus compañeros asesinados en aquella masacre. Teniendo en mente a los compañeros muertos 30 años antes, quisisteis homenajear también a Igor y Baru, ¿no es así?**

Como todos los años el 3 de marzo se conmemora la lucha llevada a cabo por la clase obrera de Gasteiz en 1976, por lograr unas condiciones dignas de trabajo y recuperar las libertades perdidas. En ese contexto se realiza un homenaje y posteriormente una manifestación en memoria y recuerdo a los cinco trabajadores asesinados y el más del centenar de heridos y masacrados en esa fecha.

Junto a las reivindicaciones de Justicia y Verdad y como un día referente de lucha, se incluyen otras relativas a problemática actual, tanto social, como laboral o política. En los últimos años se habían denunciado el cierre de Egunkaria, la Ley de partidos o el con-

flicto de Caballito, por poner algunos ejemplos y siempre dentro de lo que creemos debe significar el 3 de marzo, recuerdo y lucha reivindicativa.

Este año, tras la muerte en prisión de Igor y de Roberto en extrañas circunstancias y habiendo padecido ya nosotros versiones totalmente mentirosas y manipuladas, se leyó un comunicado en el que expresábamos nuestra desconfianza de la versión oficial y exigíamos el total esclarecimiento de los hechos, uniéndonos al mismo tiempo al dolor de sus familiares y amigos.

Como señal de condolencia y detrás de la pancarta que abría la manifestación, dos miembros de la asociación portamos una ikurriña con crespón negro y las dos fotografías de los fallecidos.






**La acometida de la Ertzaintza, por otra parte, no pudo ser más agresiva. Como ocurrió hace 30 años, fuiste herido y finalmente detenido. ¿De qué te responsabilizan?**

Estoy imputado de "desórdenes públicos y atentado", estando obligado a presentarme en el juzgado a firmar todos los días 1 y 15 de cada mes o cuantas veces sea requerido.

Como muchos saben, padezco graves problemas de visión, mi agudeza visual se estima en 1/50, debido a un traumatismo en la niñez en el ojo izquierdo y la pérdida del derecho tras la paliza recibida en marzo de 1976 por parte de los grises.

Cuando cargó la Ertzaintza en la manifestación del día 3, vinieron de inmediato a por nosotros sin darnos tiempo a reaccionar. Yo me quedé quieto y en ese momento recibí el impacto de una pelota de goma en el abdomen, del cual me di cuenta después al notar que la pelota se había quedado alojada dentro del forro polar. De seguido vi que un ertziana, justo delante mio, se disponía a golpearme con un lanzapelotas, por lo que en un acto reflejo se lo agarré para parar el golpe. De seguido los porrazos, culatazos y patadas

incluso en el suelo fueron numerosos. Me arrastraron hasta la furgoneta y me metieron a empujones. El resultado fue múltiples erosiones, contusiones y la rotura del tabique nasal.

Me dijeron que había intentado arrebatarles el arma y de eso me acusan, atentado y desórdenes públicos. Fui detenido y conducido a la comisaría de la Ertzantza donde permanecí hasta el día siguiente, que tras pasar por la juez, quedé en libertad provisional.

A día de hoy aparte de seguir firmando todos los 1 y 15 de cada mes no he tenido noticias del caso, si exceptuamos los varios trámites y gestiones que tuvimos que realizar para conseguir permiso de salida de España y poder desplazarme a Bruselas a finales de marzo, junto a otros miembros de la Asociación, para exponer nuestra problemática a diversos grupos parlamentarios europeos, permiso que en un principio me habían denegado.

Las consecuencias físicas de la agresión de este año no han sido de la gravedad de hace treinta, aunque lo podrían haber sido. Si el golpe en la nariz se desplaza unos centímetros, hubieran rematado lo que pretendieron entonces, que no era otra cosa que dejarme ciego. En cambio, si tengo que decir que a nivel moral las sufridas este año han sido mayores. Hace treinta años me dejaron tirado en la calle, en este, tras ser apaleado, he sido detenido, esposado y trasladado al calabozo como el mayor de los malhechores, soportando al mismo tiempo un trato inhumano, humillante y vejatorio.

**En tu opinión, ¿qué produjo la orden del Departamento de Interior? ¿Por qué cargaron contra tantos miles de personas utilizando una excusa tan barata? ¿Qué argumentó el mando?**

Todavía me pregunto que quisieron demostrar con esa exhibición de fuerza y de brutalidad y más si cabe en un acto de recuerdo y homenaje a los trabajadores asesinados en 1976 y que todos los años cuenta con el res-

**Me arrastraron hasta la furgoneta y me metieron a empujones. El resultado fue múltiples erosiones, contusiones y la rotura del tabique nasal**




paldo y apoyo de gentes de todo el ámbito social, político y sindical de la ciudad.

Hasta el momento de la intervención de la Ertzaintza, todo había transcurrido con absoluta normalidad y sin ningún tipo de incidentes que diera lugar a su actuación.

Es totalmente falsa la versión del lanzamiento de objetos y de proferir gritos a favor de ETA durante la manifestación. También es falso que hubiera personas (reventadores los denomina Balza) que intentaran utilizar la manifestación con otros fines. Tanto la pancarta cabecera como la ikurriña eran portadas por gentes pertenecientes a las organizaciones sindicales convocantes y a la Asociación de Víctimas del 3 de Marzo, acompañados de multitud de personas y colectivos solidarios. Los altercados e incidentes se produjeron a raíz de la brutal intervención de la Ertzaintza. Asimismo, aparte de entender que ello no entrañaba ninguna ilegalidad, en ningún momento

los que portábamos la ikurriña tuvimos conocimiento ni se nos hizo requerimiento alguno para que esta fuera retirada. A mi entender quisieron poner de manifiesto su sometimiento y su disposición a cumplir con los autos dictados por la Audiencia Nacional en los que se dejaba claro la prohibición de cualquier acto de homenaje y solidaridad con Igor y Roberto, así como con sus familiares y amigos. Más si cabe quisieron dejar bien clara su postura , después de haber sido interpelado en el Parlamento Vasco el Consejero de Interior Javier Balza, por parte del Partido Popular ante lo que ellos estimaban pasividad de la Ertzaintza ante determinados actos de la Izquierda Abertzale.

**A mi entender quisieron poner de manifiesto su sometimiento y su disposición a cumplir con los autos dictados por la Audiencia Nacional en los que se dejaba claro la prohibición de cualquier acto de homenaje y solidaridad con Igor y Roberto, así como con sus familiares y amigos**

**La misma "violencia de estado" que mató a Bienvenido, Francisco, José, Pedro Maria y Romualdo, fue la que agredió la manifestación de este año. Siendo por el contrario los responsables de la carga las autoridades del PNV. ¿Qué razón puede tener ese partido para golpear a la gente tal y como se hizo hace treinta años?**

En 1976 estábamos en una dura dictadura, hoy, en el 2006, se supone que nos encontramos en una democracia, pero los métodos de represión no cambian, siguen utilizándose los mismos y con iguales argumentos.

Un partido que dice defender la autodeterminación, que está en contra de la Ley de Partidos, que critica la situación de los presos, que reivindica el derecho de decisión, etc., no puede al mismo tiempo someterse a los dictados de Madrid y mandar a la Ertzaintza a masacrar a quienes están luchando en la calle por lograr esos objetivos.

No se puede comprender que mientras por la mañana se diera lectura a una declaración institucional por la Presidenta del Parlamento Vasco, aprobada por todos los grupos políticos, en la que se reconocía el carácter de víctimas del terrorismo a los afectados del 3 de






marzo, unas horas más tarde y desde el Departamento de Interior del Gobierno Vasco, se mandara reprimir una manifestación de homenaje y recuerdo en la que participaban muchos de esos afectados, hiriendo y deteniendo a algunos de ellos.

El porqué lo hicieron, es algo que desde el Gobierno Vasco deben explicar con claridad.

**Teniendo en cuenta la actitud hacia ti, que otra vez fuiste agredido, ¿has notado otro tipo de actitud? Esto es, los mismos sectores y agentes que se acercaron mostrando su solidaridad en 1976, ¿se han acercado ahora?**

Si bien la solidaridad y el apoyo a nivel individual tanto de la familia como de amigos y gente trabajadora fue muy grande en 1976, a nivel oficial e institucional fue inexistente. En general, han sido sindicatos de clase como LAB y ESK los que junto a la Izquierda Abertzale y algunas honrosas excepciones han mantenido vivo del 3 de marzo como fecha referencial de la clase obrera, exigiendo Justicia y Verdad

durante estos treinta años.
Este año, tanto en lo relativo a mi persona, tras la paliza y detención, como a la Asociación del 3 de marzo por el agravio que supuso para esta la intervención de la Ertzaintza, el ánimo y solidaridad recibido ha vuelto ha venir del mismo lado que en 1976, siendo una vez más, el silencio a nivel oficial, muy significativo e ilustrativo. Ni una explicación, ni una disculpa. Muy al contrario y al igual que en aquel año, en vez de buscar el esclarecimiento y depurar responsabilidades, se han dedicado a fabricar una versión mentirosa con el único fin de protegerse ante cualquier intento de exigencia de éstas por tan salvaje y arbitraria actuación.

**¿Estás preocupado con la situación que se vive en las cárceles?**
El Gobierno español está utilizando a los presos como moneda de cambio y de chantaje para lograr una posición ventajosa de cara a la negociación. Quieren buscar el desánimo y el abatimiento de los presos y presas, cosa que por otra parte no están consiguiendo a pesar del alargamiento de sus condenas o el cumplimiento íntegro de estas, todo ello, unido a la conculcación de sus derechos como personas y el sufrimiento añadido que supone el alejamiento y la dispersión. Hay que exigir que se cumpla la ley que asiste a este colectivo de prisioneros por motivos políticos. Cumplimiento que debe ser contemplado de manera separada e independiente de cualquier negociación política que se de en otros ámbitos y parámetros. Para ello la presión social y la denuncia diaria de esa política de venganza tiene que ser continua y debe ir avalada por el mayor número de colectivos, tanto políticos, sociales como sindicales.
La preocupación y el compromiso para con ellos, debe estar latente entre nosotros, todos y cada uno de los días, pues cada uno de ellos que transcurra sin solucionar el problema, se corre el riesgo de ver grave-

**El Gobierno español está utilizando a los presos como moneda de cambio y de chantaje para lograr una posición ventajosa de cara a la negociación. Quieren buscar el desánimo y el abatimiento de los presos y presas, cosa que por otra parte no están consiguiendo**






mente alterada su integridad, tanto emocional como física.

**El argumento de este libro-crónica son las muertes de Igor y Roberto y los días posteriores. De todas formas, si esto sigue por estos derroteros podemos toparnos de nuevo ante una tragedia. Siendo víctima de la violencia policial, ¿Qué opinión tienes ante la situación política? ¿Cuáles son los nudos a desatar con urgencia?**

Hay que lograr parar el sufrimiento y la tragedia que supone y genera el conflicto en Euskal Herria para una gran mayoría de sus ciudadanos. En este sentido y como he comentado anteriormente, lo más urgente y perentorio es solucionar y aliviar la situación en las cárceles de los presos y presas políticos vascos.

Junto con ello debemos lograr sin imposiciones de ningún tipo y de nadie, mediante el dialogo y la negociación de las partes en conflicto, crear un espacio de decisión propio que sea respetado por todos en los términos previamente acordados.

El derecho a decidir y organizarse libremente es un

derecho inherente a todo Pueblo. En Euskal Herria ese derecho ha sido negado y conculcado sistemáticamente a lo largo de muchos años y eso ha dado lugar al enfrentamiento y la lucha por recuperarlo.
ETA ha dado un paso muy importante con el cese de la lucha armada para poder afrontar la situación en una mesa. Ese paso no parece que haya sido correspondido con ningún gesto trascendente por las otras partes interesadas en la solución. Al contrario, se está forzando más si cabe la persecución y represión contra personas empeñadas en lograr ese acuerdo satisfactorio para todos y ese no es el camino.
Los que aquí nacimos y vivimos tenemos que impulsar y exigir ese encuentro que permita alcanzar el tan ansiado acuerdo y con ello la paz y tranquilidad que este Pueblo se merece tras quemar muchas de sus energías en esa lucha para ser reconocido como tal.

**¿Hay espacio para la esperanza?**
Hay que pensar y desear que si. Será largo y laborioso el proceso, pero espero que al final se consiga un acuerdo que sea del agrado de todos.
Sería muy triste y en ningún caso deseable que este proceso no fructificara en algo positivo, después de los esfuerzos y empeños realizados por una mayoría de implicados.
Será preciso salvar muchos obstáculos y zancadillas, habrá que ser pacientes y desarrollar al máximo la imaginación, pero esperemos que con la voluntad previamente expresada por todos se logre el resultado final apetecido ■

**Se está forzando más si cabe la persecución y represión contra personas empeñadas en lograr ese acuerdo satisfactorio para todos y ese no es el camino**

# Martxoak 2



GAUEKO EKAITZAK UTZITAKO PUTZU TXIKIAK AGERI ZIREN ARTEAN. DEBEKUEN GAINETIK, HAMAIKA HERRITAN AURKITU GENUEN BITORIANO GANDIAGAREN AZKEN BERTSOEN PAREKO LEKUKOTASUNIK: "LURRAK BILTZEN GAITU ETA ZERUAK INGURATZEN. NORK NAHI DU GURE ARTEAN LURRIK ZATIKATU?"

Goizarekin batera senideen bizipenak ezagutu genituen, lehen eskutik, hurrengo orduetan. Bilbon eskainitako prentsa agerraldi batean ezagutu genuen Idoia Muruaga, Igorren neska laguna. Mendiko isiltasuna ekartzen dugu akordura maiz, eta egia da, baina prentsa agerraldi hura hasi aurretiko isiltasuna ehundura lakarrekoa zen. Anboto bidean jotzen duen haizeak adina galdera gogor uzten duen horietakoa.

"Igor hil dute. Erahil dute". Holaxe laburbiltzen zuen Idoiak senideen ustea, era batez edo bestez kartzelak eraman zuela adierazi nahian. Halakoetan lan mekanikoa egiten dute kazetariek: esku-grabagailuak bozeramaileen ondoan utzi, kableen artean aulki librea topatu, kaiera belaunen gainean jarrita arreta aurpegia jarri, eta maizegi, objektibo eta kameren aurrean jezarrita diren aurpegiei kortesia fortzatua eskaini ere, soldata mehearen truke ezin baitituzte beretzat hartu -pentsatuko dute- Herri honetan atzera aurrera dabiltzan auzi justu guztiak.

Heriotzaren kinka larrian, aldiz, oso bestelako erreakzioak harilkatzen dira. Izan ere, begirunea gailentzen zaio komunikabideen goiburuetan irakur daitezkeen hainbat adierazpenen probokazioari. Galderei erantzunez, etika politikoaren irakasgai majistrala eskaini zuen Balzak senideek esandakoa galdegaitzat hartuta:





"Penagarria da semea lurperatu behar duen familia bat mota honetako tirabira politikoen erdian egon behar izatea", dolu adierazpenak erakunde terrorista bat goraipatzeko erabiltzea onartezina zela gogoratuz. Ziur gaude bulego ofizialetan ohituta eta eginda dauden kazetarien kontzientzia lokartuan ere atximurra sentitu zutela. Okagarria izan daiteke-eta gure artean lurra zatikatzeko ahaleginaren estiloa.

Hori horrela, Santurtzik greba orokorrerako deialdia zabaltzen zuen. Dendariek, portuko langileek, eskoletako ikasle eta irakasleek, espainiar Zigor Kodeak dioenari muzin eginez, ekin zioten greba prestatzeko lanari. Piketeak herritarren haserrearen notario hutsak izango ziren, merkatarien eta ostalarien elkarteek ere deituta haize alde baitziharduen protestaldiak.

**Santurtzik greba orokorrerako deialdia zabaltzen zuen. Dendariek, portuko langileek, eskoletako ikasle eta irakasleek, ekin zioten greba prestatzeko lanari**

Mundua kolorez pintatzen saiatu ginenean,
zuok, mundu gris aseptikoa maite duzuenok,
makilkadez ordaindu zeniguten ahalegina.
Zuok, horma zuriak maite dituzuen horiek,
Zer bilatzen duzue zehazki ?
Zer bilatzen duzue, zuon polizia, epaile
Eta kale garbitzaileekin ?

Ez al duzue ulertu, urez garbitzen diren margoketek
Harrian (eta herrian) arrasto sakona uzten dutela?
Ez al duzue ulertu loreak moztu daitezkeela,
baina udaberria ezin dela gelditu?
Ez al duzue ulertu, kale poeta eta margolariak
Ezin direla isildu?
Ez al duzue ulertu, horma zuriak maite dituzuenok,
Ez dela horma zuririk existitzen?

Eneko Barberena



Gure herrian, eskuarki, albiste txarrak dakartzate irrati albistegietako azken orduko oharrek. Gaueko trena zetorren Ezkerraldera, berriro ere berri gogorrekin ■

# Martxoak 3




EGUERDIA ZEN ETA SANTURTZIKO PLAZAN JENDEA BILTZEN HASI ZEN. GEHIENGO SINDIKALAREN EHUNKA ORDEZKARIK ERANTZUN ZIOTEN GREBA ETA KONTZENTRAZIO DEIALDIARI. ESTATUEN GOBERNUEK EZARRITAKO ESPETXE POLITIKAK HIL EGITEN DUELA SALATZERA BILDU, ETA BERRIRO ERE HIL EZKILEK JO ZUTEN. ORDUBETE GOIZAGO HIL ZEN ARANJUEZEKO PRESONDEGIAN ROBERTO SAINZ OLMOS, ITXURA ZENEZ BIHOTZEKO BATEN ONDORIOZ.




Basurtoko hospitalean lan egiten zuen LABeko kide honek 41 urte zituen, eta 2003ko irailaz geroztik kartzelan zegoen. Hiru aste luze bazeramatzan bularrean mina zuela esanez, baina toki txarra da kartzela gaixotzeko. Edo hobeto esanda, sendatu nahi iza-



## Santurtzitik Portugaletera pasatu zen saminaren lekukoa, itxaropenaren aduanan xentimorik utzi gabe. Besoak erorita bizitzerik ez dagoen bezala, zaila da oso besoak puskatuta arraun egitea

nez gero, hobe duzu preso egonda ez tokatzea, hormatzarren artean eritasuna usu bilakatzen baita heriotza zigorra. Bi urte pasatxo zeramatzan kartzelan, bere neska-lagunarekin batera Ertzaintzak atxilotu eta gero. Bizirik eraman zituzten, baina Baru hilotz ekarriko zuten.

Sinesgaitza. Bost egun beranduago, ondoko herriko semea zen beste euskal preso politiko baten heriotzak hankaz gora jarri zuen Euskal Herria. Pentsaezina zen horrenbeste min. Jasangaitza horrenbeste ankerkeria. Santurtzitik Portugaletera pasatu zen saminaren lekukoa, itxaropenaren aduanan xentimorik utzi gabe. Besoak erorita bizitzerik ez dagoen bezala, zaila da oso besoak puskatuta arraun egitea. Eta halere, brankari begira jarraitu zuen Euskal Herriak.

Mobilizazioak nonahi egin ziren, eta gutxi izan ziren enfrentamendu latzak ezagutu ez zituzten tokiak. Ertzaintzaren oldarradiak ulerkaitzak ez ezik, zinez biolentoak ere izan ziren. Inork ez zuen hitzik beren jarrera kalifikatzeko. Euskal borrokalariei azken agurra ere ukatzea eta debekatzea gorrotoan eta mendekuan oinarritzen da, baina zerbait








## Ezker Abertzaleak berretsi zuen bere apostua: martxoaren 4an denok Santurtzira. Hogeita lau orduko epea zuen Jaurlaritzak arduraz jokatzeko

gehiago ezkutatzen du: jipoituenetan jipoituenak egurtzen jarraitzeko asmo sendoa. Sadismo zantzuak, nonbait.

Egun haietan patetismoraino protagonista izan zen Miren Azkaratek beste esaldi ahaztuezina oparitu zigun ostiralean: jendartea "harrituta, nora ezean" zegoela zioen, eta, aldi berean, burua hotz izan zezaten egin zion galde Euskal Herriari. Une berean, basapiztien erara ehiztatzen ari ziren abertzaleak kalez kale, Ertzaintzaren herrak bultzaturik.

Dramatikoa izan zen Gasteizko gertaera. Martxoak 3ko sarraskiaren hogeita hamar urtemuga gogoratzeko burutzen ari zen manifestazio jendetsua desegin zuen Ertzaintzak. Hamarka izan ziren ospitalera eramandakoak, eta bi lagun atxilotu zituzten. Zaurituak eta atxilotuak izan ziren Andoni Txasko eta Josu Ormaetxea, hiru hamarkada lehenago Fragaren poliziak ere ospitalera eraman zituenak. Jipoitzeko eta kalabozoetara eramateko egotzi zietena edonor lotsatzeko modukoa izan zen: terrorismoaren goraipatzea. Gasteizko kaleetan milaka pertsona erasotuz izua zabaldu zutenen arrazoiek terrorea erabili zuten aitzakia. Baru eta Igorren argazkiak esku artean amultsuki eramateak, hildako bi presoen argazkiekin xingoladun ikurrin batean eramateak eragin zuen oldarraldia. Haiek bai terroristak!

"Fraga, Balza berdin da" entzun zen ozenki hurrengo ordu eta egunetan. Gau berean, Campanades a Morts abesti hunkigarria kantatu zuen Lluis Llachek, Mikel Laboarekin batera, Mendizorrotzako kirol aretoan. Larruan oraindik bizirik dirauten sentimenduek segida aurkitu zuten





Gasteizen, negu luzearekin gogaituta, oinazearen arrasto mingotsean etzanda.

Herrizaingo Sailaren prentsa bulegoak, bere aldetik, ez zuen atsedenik hartzen. Hurrengo egunerako Santurtzin deituta zeuden ekitaldi guztiak debekatuz zabaldu zuten iluntzean enegarren jakinarazpena. Ezker Abertzaleak berretsi zuen bere apostua: martxoaren 4an denok Santurtzira. Hogeita lau orduko epea zuen Jaurlaritzak arduraz jokatzeko. Egun oso bat bere esku Ibarretxek, baina kasu honetan pertsona guztiak eta hildakoekiko begirunea ez omen ziren ororen neurri eta helburua.

Beste sarraski bat diseinatzen eman zuten gaua Lakua eta Arkauteko istiluzaleek ■

**Une berean, basapiztien erara ehiztatzen ari ziren abertzaleak kalez kale, Ertzaintzaren herrak bultzaturik**

# Martxoak 4





LARUNBATAK BELZTU ZUEN SANTURTZI. HERRIKO PLAZA HESITU ZUEN ERTZAINTZAK ARRATSALDEKO LEHEN ORDUETAN, ETA BAKARRIK BERE NORTASUN AGIRIA ERAKUTSITA PLAZAN BERTAN BIZITZEN ZIRELA FROGATZEN ZUTENEI ZABALTZEN ZITZAIEN BIDEA. ZINTA ZURI-GORRI BATEK MARKATZEN ZUEN DEMOKRAZIAREN MUGA, HURA GAINDITUZ GERO TERRORISMOAREN EREMUAN SARTZEN GINEN.

Ordurako itxita zeuden Santurtziko sarrera guztiak. Bakar bat ere libre utzi gabe. Kostaldeko trenbidea ez zen geratzen herriko geltokian, eta A-8 autopistatik irtetzeko puntuak ertzainez josita zeuden, santurtziar izaera frogatzekotan soilik sartzen uzten zutela. Kazetariak ere lekuko desatseginak ziren, eta Francoren garai ilunetan polizia kordoiak gainditzeko usu erabiltzen zen argudio-gezurra ere alferrikakoa: ezta mezatara joateko ere!.

Jendearen irudimenak, ordea, asmatu zuen herrian sartzeko alternatiba ugari. Zahar eta gazte, herrialde guztietako herritarrak amildu ziren baratza eta maldan beherako kale estuetatik barrena, eta omenaldia iragarrita zegoen plaza inguruko kaleetan bildutakoak milaka ziren ordurako. Lehen buruz burukoan, herritarrak garaile.

Txingurritegietan bezala, ondoko kaleak zeharkatzen zituzten abertzaleak atzera aurrera mugitzen ziren. Esku-bozgoragailua behar zela, pankarta hona ekarri behar zela, zer egin plaza erabat itxita gure omenaldia egiteko. Galdera eta proposamenak gurutzatzen ziren Herriko tabernaren pare, erabaki argi baten mesederako: egin egingo dugu. Ezaguna zen jadanik bertaraturiko polizien asmoa. Legea betetzera ziren joanak, alternatiba eta errukitasunik gabe.

Bihozbera da arrazoia, eta zurruna dira ezina eta aginkeria.

Otegi, Olano, Barrena, Permach, Enparantza eta beste abertzaleen ahaleginak antzuak izan ziren. Bigarren asaltorako beltza-ren alde jokatu zuen dirua kazetari askok. Irudiz, ez zegoen arratoizulo hartatik ondo libratuta ateratzerik. Dena dela, jendetza hasi zen pixkanaka mugitzen eta konturatu orduko milaka pertsona osatzen zuen manifestazio batek hartu zuen Portugaleterainoko bidea, Robertoren gorpua herriko kanposantura eramango zutela jakinik. Ustekabean, beldurraren keinua etxez aldatu zen. Beste behin ere ezina ekinez egiten dela bistakoa zen-eta. Debekatuta egon arren, egitea posible zen.

Bi herrien arteko mugan, malda samur baten buruan, Ertzaintzaren furgonetek bidea moztu zioten manifestazioari, eta elkarrizketa saiakera oro zapuztuz, karga izugarria egin zuten. Badira gure memoria kolektiboan klixe ahaztuezinez grabatuta geratzen diren irudiak, eta arratsalde hartan bertan bizitakoak Sergei Eisentsein zinema zuzendari sobietarraren luzemetraien epika ekarri zigun gogora.

Etenaldi bat egin al zuen denborak? Zenbat minutu, ordu, egon al zen jendea pelotakadei eta borra kolpei eutsiz? Duintasunak irabazi zuen bigarren buruz-burukoa ere, Robertori azken agurra emateko deliberamendua hartuta baitzuen Euskal Herriak. Ez zen indar mugagabe hura geraraziko zukeen harresirik. Hamarka zauritu atzean utzita, ertzainek atzera egin zuten. Inork ez du sekula jakingo nork eman zuen agindua, baina milaka pertsona haien irmotasunak estatu arrazoi krudelaren mugak gainditu zituen. Ikurrina bat eskuartean zutela, Portugaleteko kanposanturainoko bidea egin zuten. Euskal Herria aurrera!

**Beste behin ere ezina ekinez egiten dela bistakoa zen-eta. Debekatuta egon arren, egitea posible zen**

Bertan, Ertzaintzaren bigarren checkpointa zegoen. Brigada Mugikorraren txanda zen. Janzkera mehatxugarria, jarrera oldarkorra. Baina berandu zen jendea kokiltzeko. Kanposantuaren sarrera ondoko errepidearen bi aldeetara finkatu ziren posizioak, eta ilundu arte eutsi ere. Egia ez dago gertakarietan, beren kontakizunen begiradan baizik, eta egun hartan, gerra gorriko kronika egitearekin batera, Ezker Abertzalearen barruko indar xaloari egin zitzaion agur.

Baru-ren gorpua iritsi zenean gaua zen nagusi. Atze-ohial beltzak ez zuen itzali herritarren omenaldi ixila. Urrundik bazen ere, Eusko Gudariak kantatuz jaso zuen bere sorterriak Robertoren hilkutxa. Egun historikoa bere azken arnasa ematen ari zen. Euskal Herriko kalezulo estu eta zarpatsu guztietara zabaldu zen duintasunaren lezioa ■



Duintasunak irabazi zuen
bigarren buruz-burukoa ere,
Robertori azken agurra
emateko deliberamendua
hartuta baitzuen
Euskal Herriak




Badira gure memoria kolektiboan klixe ahaztuezinez grabatuta geratzen diren irudiak, eta arratsalde hartan bertan bizitakoak Sergei Eisentsein zinema zuzendari sobietarraren luzemetraien epika ekarri zigun gogora




Duintasunak irabazi zuen
bigarren buruz-burukoa ere,
Robertori azken agurra
emateko deliberamendua
hartuta baitzuen
Euskal Herriak





Bigarren asaltorako beltza-ren alde jokatu zuen dirua kazetari askok. Irudiz, ez zegoen arratoizulo hartatik ondo libratuta ateratzerik







Baina berandu zen jendea kokiltzeko. Kanposantuaren sarrera ondoko errepidearen bi aldeetara finkatu ziren posizioak, eta ilundu arte eutsi ere






Egia ez dago gertakarietan, beren kontakizunen begiradan baizik, eta egun hartan, gerra gorriko kronika egitearekin batera, Ezker Abertzalearen barruko indar xaloari egin zitzaion agur



Egun historikoa bere azken arnasa ematen ari zen. Euskal Herriko kalezulo estu eta zarpatsu guztietara zabaldu zen duintasunaren lezioa





# Martxoak 5

*"Llevamos más de mil días sin muertos, y eso es positivo, pero ETA debe dejar las armas" (Jose Blanco, PSOEko goi arduraduna).*
*"Albiste pozgarria da Euskadirentzat 2003ko ekainetik hona hildakorik ez egotea" (Juan Jose Ibarretxe)*

2003ko ekainetik gaur arte:
espainiar eta frantziar estatuek,
**16 EUSKAL HERRITAR HIL DITUZTE**

| | |
|---|---|
| Arkaitz Otazua | Karmele Solaguren |
| Sara Fernandez | Juan Jose Urrutia |
| Kepa Miner | Gotzon Landeta |
| Oihane Errazkin | Iñaki Fernandez |
| Anjel Berrueta | Imanol Gomez |
| Kontxi Santxiz | Joxe Anjel Altzuguren |
| Arantxa Otamendi | Aitor Elorza |
| Leo Esteban | Igor Angulo |

**BIOLENTZIA ZUENA, HILTZAILEAK!!!**
**HERRIAK EZ DU BARKATUKO!!!** Askatasuna



EMOZIOAK EZTARRIAN KORAPILATUERIK ESNATU GINELA, IDOIA MURUAGAREN HITZEK JARRI ZIOTEN GOIBURU EGOKIA BEZPERAKO KRONIKARI: "MAITASUNA, MAITASUNA ETA BABESA BESTERIK EZ DUGU JASO AURREKO EGUNOTAN. NOLANAHI ERE, EZ GAITUZTE GERARAZIKO. EUSKAL HERRIKO BAKEA ETA ASKATASUNA LORTU ARTE, EZ DUGU AMORE EMANGO".

Joan zen eguneko irakaspen historikoaren sokatik tiraka, konponbiderako prozesua sendotzeko eta gobernuaren eta Ertzaintzaren jokabideari erantzuteko Greba Orokorra deitu zuen Ezker Abertzaleak igandean bertan.

Mila egun hildakorik gabe errepikatzen zen, temati, espainiar gobernuaren interesak gordetzen dituen iritzi-sortzaileen tribunetatik. Josu Jon Imazek ere, perspektibaz hitz egin zuen goiz hartan Euskadi Irratiko uhinen laguntzaz, indarkeriarik gabeko elkarbizitza behin betiko egonkortzea ametsa zuelarik. Gezurren kiratsa ohe ondoko irratiraino iristen zela konturatu ginen beste behin ere, inozokeriaren adina betierekoa bailitzan.

Indibidualismo berriaren ikusmoldeari txertoa jarrita, Igor eta Roberto ortzemugan marraztea. Horrelaxe labur zitekeen martxoaren 4ak utzi zuen oldarrosteak. Idoiak esan zuen bezala, maitasuna barra-barra zerion gure Herri zaurituari ■







AGUR ETA OHORE, IGOR ETA ROBERTO!




Igor Angulo eta Roberto Sainz del Olmo gure presokide eta lagun maiteak akabatu ditu espainar espetxe politika kriminalak. Honezkero, heriotza zerrenda luze bezain beltz horrek 21 euskal preso politiko kolpatu ditu. Modu berean, gure hamasei senide eta lagun ditu hilotz utzi. Haien espetxe politika gerra klabean, sarraskian, triskantza politikoan, oinarritzen segitzen baitute gobernuek. Ez dago beste azalpenik.

Igor eta Robertoren senideei helarazten diegu gure doluminik sentituena, gure adore eta maitasuna. Jakin ezazue haiek maite genituen bezala, zuek ere maite zaituztegula. Harro gaude Igorren eta Robertoren borroka ibilbideaz. Harro espetxeari aurre egiten zioten moduaz. Eta harro, azkenik, zeuek, senideok, heriotza horien aurrean erakutsitako duitasun eta kemenaz. Biba Igor eta Roberto! Biba zuek! Iritsiko da Igor, Roberto eta gainerako presokide hildakoak omentzeko eguna: Euskal Herriaren garaipen eguna, alegia.

Espetxeak eragindako heriotzak ez dira sekula izaten kasualitatea. Ez dira heriotza naturalak, ez eta gertakizun tamalgarriak, hilketak baizik. Heriotza horien guztien oinarrian badelako espetxe politika kriminala. Moldez, gure eskubide guztiak urratzen dituen politika zapaltzailea da eta, helburuz, euskal askapen borroka baldintzatu nahi duen espetxe politika baita.

Presook, gure senideak eta bizitzen dugun espetxe egoera erabiliz etekin politiko bat aterako dutelakoan, jarri izan dituzte indarrean espetxe politika zapaltzaile ezberdinak urteotan, zein baino zein krudelagoa. Hala Euskal Herritik aldentzea, segurtasun gorenezko espetxeak,




## Iritsiko da Igor, Roberto eta gainerako presokide hildakoak omentzeko eguna: Euskal Herriaren garaipen eguna, alegia



erregimen militarizatuak, isolatze politikoa, nola dispertsioa. Azkena, dispertsioa, luzeen mantendu duten eta sufrikario handiena eragin duen espetxe poltika da, ez zuela etekin politikorik emango hastapenean bertan agerian geratu bazen ere.

Inoiz pentsa liteke dispertsioarekin espetxe politika zapaltzaileek gaina joa zutela. Hara non, ordea, berau osatzera datorren espetxe politika zahar-berria trinkotzen ari den: bizi arteko esptxealdia hain zuzen. Aurrekariak badira eta espetxe politika hau ez da sortu egun batetik bestera. Aldiz, aspaldian ari zen euskal preso politikoon espetxealdia laburtzeko zangotrabatzen espetxez espetxe. Espainiar Kode berriztatu eta 40 urteko espetxealdi laburtu ezina jarri zuten indarrean. Frantziarrak lehendik arautzen baitzuen biziz arteko zigorraldia. Zaintza Epaitegi Zentrala sortu eta Bermudez jauna bezalako epaile faxista baten esku utzi zuten. Oinarrizko gure eskubideak bermatu ez eta Kode zaharraren eraginpean geratzen ginenontzat ebazpen petralak hartze hasi ziren. Enrike, Lobato, Iñaki, Unai, Filipe eta beste hainbeste, kate luze eta astun bereko begiak baizik ez dira.

Azkenik, erredentzio oro indargabetu dute Espainian ebazpen judizial berri baten bidez. Presook espetxean bertan usteldu behar dugula esan zuen Aznar faxistak. Paris eta Madrilgo gobernuek urrats eraginkorrak ematen dituzte norabide horretan. Euskal Herriaren alde jarduten duen guztientzako mezu argia da: Estatu biek preso gaituztela betiko. Bizi arteko espetxealdiak indarra hartu du, ondorioz. Dispertsiotik harago joan nahi duen espetxe politika berria bada. Helburua, ordea, betikoa: askapen prozesua baldintzatzea, espetxe politikaren bidez. Euskal Herria aukera berri baten aurrean dagoela, gatazka betikotzeko nahia erakusten dute





egungo mandatariek. Ez baita gatazkarik konponduko preso eta iheslari politikoen afera bideratu gabe. Gure herriaren aitortza eta erabakitzeko eskubidearen errespeturik gabe konponduko ez den bezalaxe.

Ez daitezela tronpa mandatari mendekuzale horiek, gure Kolektiboak apustu garbi eta tinkoa egin du Konponbide Demokratiko baten alde. Hau da, Euskal Herriaren lurraldetasunean eta autodeterminazio eskubidean oinarritzen den konponbidearen alde. Apustu horri eusten diogu eta, Igor eta Roberto gogoan, indar biziagorekin eutsiko ere. Bizi arteko espetxealdiarekin, heriotzarekin berarekin, ordainarazten badigute ere, Euskal Herriaren aldeko apustuari eta gure borroka tokiari helduko diogu.

Ez daitezela tronpa Espainiazaleak eta autonomiazaleak ere, gure herria zatitzen duen autonomiaren kudeatzaileak beharbada. Pairatzen dugun espetxe politika kriminalaren sostengu ezinbestekoa izan dira urte luzean, eta orain, autonomiaren izenean hain zuzen, zipaio armatuak erabiltzen dituzte gupida gabe Igor eta Robertoren heriotzengatik dolua erakusten duten herritarren kontra. Madarikatuak halakoak! Biziki txalotu eta eskertzen dugu, bestalde, herritar anitzek egunotan egin duten dolu adierazpen zintzoa eta eman duten erantzun irmo bezain ereduzkoa. Sinetsita baikaude espetxe politika kriminalari buelta emango zaiola, herri presio iraunkorretik eragiten bazaio.

Agur eta ohore, Igor eta Roberto!

# Martxoak 6

ANA LOPEZ SOTO DEL REAL ESPETXETIK EKARRI ZUTEN ILUNABARREAN. BARU HIL ETA GERO, PENDIENTE ZUEN AZKEN AGUR BAKARRA BERE NESKA-LAGUNARENA ZEN, BERAREKIN BATERA ATXILOTUA ETA ESPETXERATUA. IZAN ERE, KARTZELA BARRUKO LAU HORMATZAR GORROTAGARRI HAIEN ARTEAN ZEGOELA IZAN ZUEN ROBERTOREN HERIOTZAREN BERRI. NAIPE GAZTELU ERRALDOIA BEHERA JOAN ZEN, BIDEAN AMETSAK ETA AURRERA BEGIRAKOAK AMILDUZ.

Ate giltzarrapoen hotsak Madril aldean utzita, elkartasunaren musikak laztandu zuen Anaren entzumena Portugaleteko beilategira hurbildu orduko. Esana zuen, espreski, Roberto ikusi nahi zuela azkenenengoz, galera sentsazioari aurre egiteko modu bakarra hura baitzen: mutil-lagunaren eskua hartzea, azken musua eman ahal izatea, bere alboan xuxurlaka aritzea beste interferentziarik gabe. Beste era batera esanda, intimitatearen azken lubakian tartetxo bat egin nahi izan zion elkar begiratzeari, bihotzetik ere ikusten baitugu elkar. Hori sinetsita, gorpua erraustu baino lehenago ireki zizkion ateak bizipozari.

Hurrengo eguneko egunkarietan denok ezagutu genuen Anaren irrifarrea. Bizilagunen elkartasun oihuek eta elkartasunezko keinuek ongarritu zuten bere animoa, eta lehengo ostiraletik lehen aldiz ziurrenik, irri egin zuen. Begiekin eta ezpainekin, barru-barrutik zetorren emozioari bide eginez.

Tristezia menderatu zuen arnasa inguratu zitzaigun gogora, martxoak zazpi zituenean.

Bitartean, euskal preso politikoen senide eta lagunek jarraitu zuten erromes bidea bi estatuen errepideetan zehar, eta istripu berri



## Begietara so egiteko zuzentasunak bereizten du humanitatea. Presoak badaki nora begiratu. Kartzelariak ez daki non lurperatu begirada

bat ezagutu genuen, oraingoan Pancorboren inguruan. Dispertsioaren patu lakarrak ez zuen leundurarik erakusten, eta Greba Orokorra deitzeko arrazoiak zein deialdiak pilatzen ari ziren. Martxoaren 9an hogeita hamairu urte beteko zituen Igor Angulok biziz geroztik, eta bizi izan genuena eta bizi izan ez genuena neurtzeko betarik aurkitu genuen gauaren laguntzaz. Olatuek erantzun ziguten bakarrik, gauerdiko ahots marrantatua bidelagun.

Aragoiko hegoaldeko muturrean, bestalde, Mercedes Gallizo Espetxe Zuzendari nagusiak Teruelgo kartzeleko euskal preso politikoen erantzukizun eskaerak jasan behar izan zituen. Deseroso hartu zituen beren demandak, borreroak beti jokatzen baitu mesfidati heriotzera eraman nahi dituen pertsonen duintasunaren aurrean.

São Pauloko faveletan edo Caracaseko ranchitoetan bezala, jende xumearen harrotasuna ez da neurtzen dolarretan; ez eta azpiegitura sanitarioaren egoeraren bitartez. Begietara so egiteko zuzentasunak bereizten du humanitatea. Presoak badaki nora begiratu. Kartzelariak ez daki non lurperatu begirada ■

# Martxoak 7-8



Milaka zubi zure eremuko muinoetaraino
arantzez, hilkutxez eta elktrodoz josiak
milaka, banderak eta himno inperialak
etengabe datozen suge gazte saldoak
aizkora bihurriekin borroka kamuflatu batera
ohorezko tiroak eta ohore gabeko tiroak
eta odolez gainezka zuregainainoko ibaiak.

Garestia da bakea lur hauetan.

Urtzi Urrutikoetxea
("Borroka galduetatik gatoz")



Itxaronaldia. Holaxe izendatu daiteke hurrengo orduak bete zituen inpassea. Batzarrak egiten hasi ziren hiri handietako industria poligonoetan. Aspaldi ez bezalako eztabaidak piztu ziren nonahi, eta komunikabide idatzien eta uhien bidez gurutzatzen ziren elkar leporatze larrietatik harago, auzo eta fabriketan haragitu zen grebaren ezbaia. Errutina eta konbenio mailako jerga tekniko-sindikalaren hizketamodu erdoilduaren ordez, mingaina txingortuez ekin genion Euskal Herria geratzeko erronkari.

Anartean, Ezkerraldeko lagunek ondo asko ikasi zuten Gabriel Garcia Marquez-en aintzinako gogoeta: "Orduantxe ulertu nuen hiltzea lagunekin inoiz gehiago ez egotea dela". Igor eta Baru-ren hutsuneak beren ametsen lurraldea zulatzen zuen gupidagabeki, eta bakardadea igo zen haien sorbaldetara billetea ordaindu gabe. Santurtzi eta Portugalete euri malkotan itotzeko beldur zirela, artizarrak piztu zuen erresistentziaren kriseilua.

M-9 Greba Orokorra. M-9 Greba Orokorra. M-9 Greba Orokorra. Aske bizitzeko deliberoa hartu genuontzat ez dagoeta harresiek marrazturiko orubetan hiltzerik. Nahiz eta lurrak presa izan berea erreklamatzeko.

Loak hartu baino lehenago jakin genuen hurrengo egunean GARA egunkaria ez zela kiosko eta saltokietan egongo. Goizalban, lehen mugarria ■

# Idoia MURUAGA
# Ana LOPEZ

## “Maitasuna eta babesa horrenbestean eman dizkigun Euskal Herrian ehunduko dugu gure etorkizuna”

**IDOIA MURUAGA ETA ANA LOPEZEKIN TARTETXO BAT HARTU DUGU KRONIKA HONETAN ALETU DITUGUN JAZOERA GUZTIEN GAINEKO BESTE IKUSPEGI BAT LORTZEKO. BEHARBADA, INTIMOENA. DUDARIK GABE, SENTIKORRENA. BIEK DUTEN ESPERIENTZIA AMANKOMUNA -MUTIL LAGUNA MODU HORRETAN GALTZEA- HIZKETABIDE, PAUSALEKU BAT AURKITZEN DU EMOZIOAK.**



Hilabeteen joanean, oroitzapenak ordenatzen ohi ditugu. Igor eta Robertoren hilketen haritik pasio izugarriak askatu ziren Euskal Herrian barrena, baina, denbora aurrera joan ahala, zer geratu zaizue sakonen grabatuta?

Idoia: Atzera begira beldur gehien ematen didana da pentsatztea batzuei gertatutakoa ahaztuko zaiela. Dena dela, egun haiek gogoan, eta argazkiak oso gutxitan ikusi ditudan arren, ikusten dut nire burua, ikusten dut Baruren aitaren irudia, eta orduan konturatzen naiz: nolakoa izan zen bizitakoa eta gertatutakoa! Horrez gainera, oso errotuta dudan beste sentsazioa da mina eta ezintasunarena. Ez soilik nirea, inguruko lagunena eta jende arruntarena baizik. Gehien

maite duzun pertsona hil eta gero, zure sorterrian gorpuarekin sartzen ez uzteak areagotu zituen sentimenduak dira horiek. Hala eta guztiz ere, sakonen garbatuta geratu zaidana izan dira herritarren babesa eta maitasuna. Cuencan jadanik antzeman genuena, une oro, minuturo, Santurtzin sartzean azala pinportu zigun mugagabeko maitasuna.



Ana: Unea hain intentsoa izanik, sentsazio ugari gurutzatzen dira. Baina kartzelatik ikusita, bi aipatuko ditut. Lehena, herria, Portu eta Santurtzi. Igor hil zutenetik, telebistaz ikustea nola jipoitzen zuten jendea, hemen montatu zen guztiaren dimentsioak harritu ninduen. "Ni han egon beharko nukeen", esaten nion nire buruari. Bigarrena, nire kartzela kideak. Ni isolamenduan nengoen, eta soilik leihotik leihora hitz egiteko aukera genuen. Bertan zeuden lagunekin akordatzen naiz maiz, haiek eman zidaten ahozko babesa, ikustezina nolabait, eta sekula ez dut ahaztuko une hartan nire alboan egon ziren kideen izen-abizenak. Portuko beilategiraino eraman nuen sentimendua izan zen hura. Ez nintzen Ertzaintzaren beldur egon, nahiz eta haiek atxilotu eta torturatu gintuzten. Kolektibo osoa eraman nuen nirekin batera Baruri azken muxua ematera. Oso polita izan zen.

**Kartzelak erailtzen ditu gure presoak. Hau ez da lelo politiko bat, baieztapen enpirikoa baizik. Dagoeneko 22 preso eta 16 senide lapurtu dizkigute kartzela politika hiltzaileek. Zenbakietatik haratago, zer irizten diozue bere arduradunen**

jokabideari?
**Idoia:** Askotan galdetzen diogu gure buruari ea ez ote diren konturatzen egiten dutenaren ondorioaz. Eta noski badakitela! Dena dela, bost axola zaiela ere badakigu, nahiz eta askotan beren alderdikideek guregana hurbildu eta sentitzen dutela adieratzen diguten, nik beti esaten diet beren bozka jasotzen duten ardu-radunengana joateko, horrela jarraitzerik ez baitago. Gainera, espetxe politika hemendik ere diseinatuta dagoela badakigunez, presoekin horrela jokatzen jarraitzea guztiz mespretxugarria da.
**Ana:** Dispertsioarekin bilatzen dutena da isolamendua areagotzea. Zure inguru pertsonala eta sozialarekin, alde batetik, eta haratago, isolamendu politikoa helburu duen estratejia da sakabanketa politika. Nire eskarmentutik ideia garbi bat helaraziko diet: alferrik ari direla, denbora galtzen, zeren eta kartzelan ezagutu ditudan pertsonak, osatzen dugun Kolektiboa suntsituezina baita. Beti akordatuko naiz Lurdes Txurrukarekin, ni bezala bere laguna Anjel borrokan galdu zuen kidea izanik, beti harritzen ninduen bere barne indarrak. Zer grinarekin zetorren isolamendu modulora. Kartzelan sentitu dudan ideien argitasunari erreparatuz, zergatik gauden eta norantza goazen hain garbi izanik, orain artekoa eta bi gehiago eginda ere jai daukate Kolektiboa dispertsioaren bitartez pitzatu nahi badute. Alferrikako saiakera da.

**Eta PNVren jarrera?**
**Idoia:** Interes politiko izkutuezinak egon gabe, ez dago ulertzerik Igor eta Rober-en heriotza eta gero, Balza eta Ertzaintza baliatuz, PNVk erakutsi zuen jarrera. Are zailagoa egiten zait beren jokabidea ulertzea une politiko honetan irekita dauden aukera berriei erreparatuz gero. Hala eta guztiz ere, Santurtziko PNVko jendea lotsatuta zegoen. Niri gertatu zitzaidan, kaletik joanik nire auzoko jelkide ezagunarekin topo egitera nindoala, eta nirekin ez gurutzatzearren, berak propio espaloiz aldatzea. Kalea zeharkatu zituen

**Nire eskarmentutik ideia garbi bat helaraziko diet: alferrik ari direla, denbora galtzen, zeren eta kartzelan ezagutu ditudan pertsonak, osatzen dugun Kolektiboa suntsituezina baita**



bi aldiz, nire ondoan ez pasatzeko. Gure begiradaren beldur ziren, lotsak janda alegia.
Roberto eta Igor hilda zeuden jadanik. Zer gehiago nahi zuen PNVk? Ziurrenik estali nahi zuten kosta ahala kosta jendearen errekonozimendua, herriko jendeak bere azken agurra masiboki ematea. Horrelaxe ere sakabanaketa politikan duten erantzukizuna estaliko zutelakoan. Bistan da ez zutela lortu. Ez bata ez bestea.
Askotan esan dute EBBtik gurekin ez zirela sekula elkartuko, indarkeria dela eta. Halere, ez dute inoiz argudiobide berbera erabili PSOEkin batera ez aritzeko, GALeko jardunbide kriminala beren ardura zela ezin argiago egon arren. Berdin PPkin, tortura, hiltzera tiro egiteko politika edo dispertsioa bultzatu artean, kolaborazio jarrera erakutsi dute.





Hipokresia bihurtu dute ikur politiko, eta negozioa kudeatzen jarraitzea daukate interes bakartzat.

Ana: Nik ez nuen ezer ulertzen. Adin guztitako pertsonak jipoitzen zuten bitartean, ezer ez ulertzeko sentsazioa nagusitzen da. Beti esan dudan bezala, anai-ahizpa batek kolpatzea etsaiaren oldarraldiak baino askoz mingarriagoa da. Ezkerraldean areagotzen den egoera da hau, zeren eta familia gehienetan ditugu barrikadaren alde ezberdinetan dagoen jendea: militanteak, ertzainak, PNV, ezker abertzalea,... Nolanahi ere, martxoko bizipenetatik indartuta atera ginen, gure posizioetan askoz sustraituagoak. Azken finean, zenbait eta zitalago tiratzen badute sokatik, orduan eta zailagoa izango da elkarbizitza eraikitzea. Baina egoera tenkatzeko hautua haiek egin zuten, eta gorrotoa ere elikatu zuten.

Beraz, PNVren erantzukizuna da jarreraz aldatzea.

**Itzuli gaitezen atzera. Jarrera ofizialak alde batera utzita, nolako babesa sentitu zenuten, orduan eta gerokoetan, Santurtzi eta Portugaleten?**

**Idoia:** Bai, jende andana hurbildu zitzaidan esateko izugarri sentitzen zutela, manifestazioak ere itzelak izan ziren eta greba eguna ere izan zen bertoko zaharrenek gogoratzen zuten zabalenetakoa, nahiz eta tartean ihauteriak egon. Hostalaritzak eta dendarien elkarteak berak ere deitu zuten paroa egitera. Uste osoa dut jende asko kalera atera zela, ezker abertzalekoa izan ala ez, aski zela esateko. Beren pazientziak goia jo zuela adieratzeko nolabait.



Hortik haratago, lagunen eta familiaren artean noski nabaritu dudala egundoko babesa, baina batere normala ez den normaltasunera behin itzulita, iragana ez ahazteko etengabeko ariketan dihardut. Ez gorrotoa elikatzeko, baizik eta memoria sendotzearren. Izan ere, iritsi baldin bagara iritsi garen puntura, memoria lapurtu ez digutelako izan da neurri handi batean. Gainera, kutsu triste eta goibelik gabe. Mamariga nire auzoko jaietan ekitaldi, manifa eta omenaldi guztietan egon gara, oroitzapena astinduz, eta halaxe gustura sentitzen naiz. Naturala delako bai gure hunkidura, bai gure memoriaren kokapena eta baita, kasu honetan, Igor herrira ekartzeko, gogora ekartzeko, auzokideen ahalegina.

Alde batetik, nire etorkizuna lantzen jarraitzen dut. Baina bestetik, etorkizuna kendu didatela sentitzen dut sarri, nire gerorako proiektuak Igor eta Aitzol gure semearen ondoan baitzeuden errotuta. Hori bapa-

tean amaitu zen ametsa da orain, eta egunero nago borroketan aurrera begira bizitzeko. Gertatutakoa beti aintzakotzat harturik, baina aurrera begira.
**Ana:** Izugarria izan zen. Nik uste halakoetan inork ez duela protagonismo kuotarik nahi, ezta? Pankarta eraman, talde batean lan egin, bai, baina hortik aurrera... Erdigune eta arreta foko nagusi bihurtzean ez zara eroso sentitzen. Kalean jendeak gerarazten nau, alderdi batekoek zein bestekoek, eta egoera eskuetatik joaten zaizula sentitu dut batzuetan. Badakit fede onez, maitasunez egiten dela, eta biziki eskertzen dut, baina nik ez nuen holakorik espero. Gestoretan nengoeneko oroitzapenak ditut gogoan, hobeto ulertzeko zer zaila diren preso ohientzat izultzeko uneak, hainbeste jende zure alboan. Baina edozeren gainetik, eskerrona daukat azpimarratzeko. Ez genuen hainbeste merezi.



**Izugarria izan zen erantzuna, ezta? Badira betiko memorian geratzen diren irudiak, pasadizioak eta jazoerak,...**
**Idoia:** Niregan, dudarik gabe, sakonen iltzatuta geratu den gertaera izan zen Igor sorterrira ekarri genuen unearena. Kanposantuan bizi izandakoak. Momentu latzak izan baziren ere, oso hunkigarria izan iritsi orduko hilerriko harresitzarraren bestaldean ikurriña mordo hura ikustea, eta behin sartuta jendearen emozioari neurria hartzea. Adibide gisa, telefonoz nire lagun batekin izan nuen hizketaldia harribitxi bailit-

zan daukat gordeta memorian. Gu kotxez gentozela, Santurtzi indarrez hartuta eta Igorren gorpuaren harrera debekatua zegoela jakinda, telefonoz hitz egiten ari nintzen lagun batekin, eta berak, negar bizian, esaten zidan: "Ezin izan dugu, Idoia, ez gaituzte uzten. Sentitzen dut". Kotxetik irtenda, ordea, jende pila negarrez, familia, lagunak, ezezagunak ikustea, oso garrantzitsua izan zen niretzat. Gogorra bezain polita, benetan.

Ana: Langraitzera irtsi nintzen arte ez nintzen jabetu egoeraz. Euskal Herria su-lametan zegoela. Bertan zegoen kide batek esatean zidan: "Ana, konturatzen al zara honek duen dimentsioaz?". Eta nire artean pentsatzen nuen, "baina, hau guztia, Baru-rengatik, Portuko Baru-rengatik?". Gu beti izan ginen herriko jende xehea, herri mailako militante xumeak, ez besterik. Horregatik zipaioek esan zidatenak zer pentsatua eman zidan. Zehazki esan zidaten: "Ez baduzu egoera kontrolatzen, egoera larriagotzen baduzu, zure kalterako izango da". Nik kontrolatu? Orduan ikusi nuen gaindituta zeudela, Euskal Herriak desbordatu zituela. Une batera iritsita, jendeak harresi guztiak gaindituko zituela ulertu nuen, edozer muga pasatuko zuela.

**Roberto, Igor, baina seirehunetik gorako kide duen Kolektibo bat dugu oraindik burnisariaren bestealdean. Asko isolamenduan, beste batzuk gaixotasun sendaezinekin, eta baita zigorra beteta kartzelan jarraitzen dutenak ere. Haiek guztiak etxera ekartzearen premia zabaltzeko, zer esango zenioketeen herritar anonimo bati?**

Idoia: Esan egiten diet, ama-aitarekin elkartzen bainaiz plazan, umeak jolasean ari diren bitartean. Esaterako, Kondo Hermosa Urra dugu adibide oso adierazgarri une honetan Santurtzi, zigorra beteta ere ez baitute askatzen. Nik beti esaten diet plazakidei imajinatzeko beren senidea dela, beren semea edo, eta kondena bete ondoren ez dutela askatu nahi. Gainera,

**Kotxetik irtenda, ordea, jende pila negarrez, familia, lagunak, ezezagunak ikustea, oso garrantzitsua izan zen niretzat. Gogorra bezain polita, benetan**

beste hamaika urte kartzelan eman behar dituela. Zuk uste zenuenean zeuregana itzuliko zela. Zeure bizitzara itzuliko litzatekeela. Galdetzen diet zuzenean, kartzelaldiaren arrazoiak baloratu gabe, nolatan sentituko zinateke zu? Zer egingo zenuke?

Enpatiaz hainbeste mintzatzen den garai honetan, gure galtzetan jartzea une batez esango nieke aurreiritzirik gabe begiratzen gaituztenei. Hainbeste bidegabekeria pairatuta, zer tolerantzia puntua edukiko luketeela esan diezaguten.





**Ana:** Ni ere, Idoia bezala, ahaleginduko nintzateke ulertarazten ez dela bidezkoa espetxe barruko krudelkeria. Nahikoa eta sobera badela kartzelan egotea, eta preso egonda, biidegabea dela salbuespeneko neurriak jasan behar izatea: isolamendua, lehen gradua, dispertsioa eta abar. Nire amak esaten zuen: "Baina nire alaba inofentsiboa da. Zergatik horrela?". Nire amak bezala, jende askok ez zuen ulertuko euskal preso politikoei estutzen zaien korapilo horren zergatia, eta sentsazio horretan sakondu beharrean gaude. Guantanamo berezi horietan bizitzerik ez dagoela ulertaraziz, edozein herritar pasa daitekeela inpernu horretatik konturaraztea da jende anonimoa kontzientziatzeko egingo nukeen ahalegina.

**Ana, kartzelan zeundela izan zenuen Robertoren heriotzaren berri. Nolatan korapilatzen dira sentimenduak bizipen latz horri aurre egiterakoan ziega barrutik?**

**Ana:** Isolamenduan nengoela, ziegako atea ireki eta

zerbiztu-buru bat begiztatzearekin batera, berehala jakin nuen ezer onik esatera ez zetorrela. Katxeoa, kunda edo... Zakarki eta itzulingururik gabe bota zidan: "Su compañero Roberto Sainz ha muerto". Une hartan ez zegoen lotuko ninduen katerik edo gaindituko ez nukeen hormarik. Kartzelari guztien gainetik pasatu nuen, eta erabateko intseguritatea sentitu nuen. Igorrena gertatu eta handik aste betera Rober hilda zegoela jakitean biak hil zituztela pentsatu nuen. Horren aurrean, geraraziko ninduen indarrik ez zegoen Soto del Realen. Handik minutu gutxira Maite Pedrosa eta Lurdes Txurruka kideekin elkartu nintzen, eta barru-barruan sentitu nuen beren gertutasuna. Lurdesen bizipenak ezaguturik nire buruari esaten nion: "Berak ahal izan bazuen, nik ere lortuko dut". Eta sekula ez dut nahikorik eskertuko hainbeste maitasuna. Gure borrokabide luzearen osagaietako bat hori da hain zuzen: maitasuna. Hori gabe ez ginatekeen horren aurrera iritsiko.

**Eta, gainera, hilabete gutxi beranduago askatu zintuzten...**

Ana: Egia esanda, nik ez nuen irten nahi. Paradojikoki, telebistaren bitartez jakin nuen askatuko nindutela. Eta halere, ez nuen sinetsi nahi nitaz ari zirela. Presook egunero amesten dugu askatasunarekin, eta gure kasuan, Rober eta biok batera irtetzearekin egiten genuen amets. Ez genuen espero oso zigorra luzerik, eta planak eta abar aspaldi genituen eginak. Beraz, piezak hain bortizki mugitua, ezetz esaten nuen, ez naiz irtengo. Ezetz eta ezetz.

Portugaletera iritsi nintzenean, oso gazia izan zen egoera. Ulertzen nuen jendearen nahia, kariñoa, baina une hartan lekuz kanpo nengoen. Rober ez zegoen nire alboan. Geroztik, hobeto ikasi dut hutsunearekin bizitzen, jendearen babesa jasotzen, konpainia eskertzen

**Idoia, zure hitzek behin baino gehiagotan estutu**

**Gure borrokabide luzearen osagaietako bat hori da hain zuzen: maitasuna. Hori gabe ez ginatekeen horren aurrera iritsiko**



Beti pozik zegoen
pertsona zen,
den-dena bi aldiz
pentsatu barik ematen
dizun horietakoa,
eta hori betiko gordeko
dugu Aitzolek eta biok



ziguten bihotza ke arteko egun haietan. Igor gabe, nola jarraitzen duzue osatzen Aitzolek eta zuk bakarrik lehen -hiruren artean- piezaka osatzen zenuten bizitza-puzzlea?

**Idoia:** Oraindik ez dugu osatu. Zaila da osatzea. Oso denbora gutxi pasatu da oraindik, eta ez dakit inoiz osatuko dugun gainera, beti izango baitugu hutsune betezina, nahiz eta Igor nolakoa zen gogoratzean ahalegintzen gara hutsunea betetzen. Batik bat gogora ekarrita zer gauzak egiten zituen eta zer maitasuna erakusten zion mundu guztiari. Guretzat Igorrek beti erakutsen zigun maitasuna gogoratzeak balio itzela dauka, eta ni batzutan nahiko zakar mintzatzen banaiz ere, berari buruz hitz eginez esapide berbera ateratzen ziztaidan oharkabean: "zeru pusketa bat da Igor". Beti pozik zegoen pertsona zen, den-dena bi aldiz pentsatu barik ematen dizun horietakoa, eta hori betiko gordeko dugu Aitzolek eta biok.

Astindu hura jasan eta aste gutxitara, ETAk su-eten mugagabea iragarri zuen eta ziklo berri bati ekin zion Euskal Herriak. Halere, kartzela barruko egoera ezer gutxi aldatu da: Parot doktrina, Iñaki de Juana, sakabanaketa... Zertan oinarritu esperantza?

Idoia: Esperantza zertan oinarritu baino, nik bestelako galdera luzatuko nuke. Hain zuzen, nondik atera indarra borrokatzen jarraitzeko. Lehen esaten nuen bezala, etorkizuna oso garrantzitsua da, askatasun klabean, norberaren bizitza klabetan, haiek ez digute-eta ezer oparituko. Nik semea daukat, eta ez dut nahi berarentzat gu jasan behar izan duguna, gure lagunak pasatzen ari direna, beraz, borrokatzen jarraitzea behar bitala ere bada. Guregatik eta etorriko direnengatik, konponbide demokratikoa erdietsi beharra dago. Badakit jakin, hau ez dela bi urtetan konponduko, baina gutxienez zutabe eta langa nagusiak lehenbailehen jartzea. Lagun asko daukat kartzelan, beren neska-lagunak ere aski ondo ezagutzen ditut, herritik, bidaietatik,... Beraz, norbaitek goza dezala eszenatoki berriak esakiniko dizkigun aukerez. Hori da nire esperantza nagusia.

Ana: Bai, ni izan nintzen su-etena ostean askatu zuten lehen euskal preso politikoa, oker ez banago. Gakoa da prozesuan eta herriko errealitatean uztartuta jarraitzea. Kartzelan hori lortuz gero, kalekoentzat bezain erraza edo zaila da itxaropenari eustea. Sufrimenduak markatzen du, egia da, baina nik txantxetan esaten dudan bezala: "Ni Portukoa naiz". Beti tokatu zait baldintza zailetan borrokatzea, inguru berezi honetan, non kontrajarritako interesak sarri dauden aurrez aurre. Horregatik daukat horren garbi ez gaituztela irabaziko. Ez irabazi, ezta bizitza ozpinduko ere. Azken finean, hau guztia, kideak galtzea, horrenbeste lagun bidean geratu izana, ezin da debaldekoa izan. Nahiko nuke Historiak kontatzea bide latz honetan bizia galdu zuen azken pertsona Baru izan zela. Haiengatik guztiengatik irabaziko dugu. Ziur naiz ■

**Azken finean, hau guztia, kideak galtzea, horrenbeste lagun bidean geratu izana, ezin da debaldekoa izan. Haiengatik guztiengatik irabaziko dugu**

# Martxoak 9






ORAINDIK ARGITASUNIK GABE KALEAK ZEHARKATZEN HASI GINENETIK, EGUN AHAZTEZINA IZANGO ZELA JAKIN GENUEN. URTE LUZEETAN EUSKAL HERRIA ASTINTZEN EZ ZUEN MOBILIZAZIO EGUN BATEAN ATARIAN GEUNDEN, ETA HAIZEAK ZEKARREN HERRITARREN ASALDURA. MILAKA ETA MILAKA ELKARTU GINEN PLAZETAN ETA MASIBOKI BERRESKURATU GENUEN ESKUBIDE ZIBILEN GAILURRA: KALEA.

Euskal preso politikoen aurkako sakabanaketa politika salatzeko eta gure Herriak bizi duen gatazkari konponbidea aurkitzearen alde, greba orokor zein partzialak eta mobilizazio ugari egon ziren ostgeun hartan. Ukaezina izan zen, erraz kontrastatzen diren jende uholdeak kalean, nahiz eta Jaurlaritza eta Confebask-eko boreramaleek gutxietsi zuten erantzunaren hedapena. Berriro ere normaltasuna nabarmendu zuten, amildegitik zer gertu ari ginela ohartarazteko itxaropen ezean murgildu nahi izan gintuztelarik.

Goiza partetik, bestalde, argi ikusi genuen normaltasunaren legea ezartzeko Ertzaintza eta Espainiak Nafarroan duen beste polizia buru-belarri arituko zirela. Informazio piketeek uniformedunak lepotik kendu ezinik egin zuten bere ibilbidea, karga eta basakeriak nonahi pairatu ziren, eta Nafarroan delitu larritzat hartzen zen kalean egote hutsa.

Hala eta guztiz ere, gure Herrian diren polizia guztiak gutxiegi ziren lanuzteak, manifestazioak eta langile, ikasle, erretiratu, langebetu eta dendarien haserrea lausotzeko. Ardura politikotik eman zen erantzuna ixilarazterik ez zen posible izan, egunean zehar berrogeita hamar mila pertsonek hartu baitzuten Euskal Herria, jazarpen eta biolentzia polizialaren ahalmena parregarri utzita. Estu jarraitu gintuzten herriz herri, baina popa era-




kutsi genien une oro, aitzindaritza politikoa herritar askeren esku dagoela enegarrenez frogatuz.

Negar egiteko eskubidea ez ezik, Igor eta Baru-ren oritzapena harrotasunez erribindikatzeko nazio eguna ere ospatu zuen herritargoak. Udal aretoak okupatu ziren, burnibideak moztu, suzko barrikadak jarri, buzoa jantzita elkarreztaratzeak egin zituzten langileek, eta ehunka herritan goiz eta arratsaldez oihu bakarra entzun zen: "Dispertsiorik ez. Konponbide demokratikoaren alde".

Edozein modutan, oraindik Eusko Jaurlaritzak goia jo behar zuen bere noragabeko adierazpenetan. "ETAk soilik babestu du greba" esan zuen Azkaratek arratsalde partean. Egunsentian eztandaraziko lehergailu batzuk aitzakiatzat hartuta, Ezker Abertzaleari egotzi zion euskal jendartea erasotu nahi izatea. Adierazpen hari beretik jarraitu zitzaizkion itsu-itsu Paulino Luesma, Jose Antonio Alonso, Leopoldo Barreda, Rodolfo Ares eta soka bereko borrero ugari. Izan ere, greba eskubidea kriminalizatzeko lehen urratsa Lakuako jaun-andre likitsek eman zuten. Etxekalte edo negozio? ■

## Negar egiteko eskubidea ez ezik, Igor eta Baru-ren oritzapena harrotasunez erribindikatzeko nazio eguna ere ospatu zuen herritargoak











Milaka eta milaka elkartu
ginen plazetan eta masiboki
berreskuratu genuen
eskubide zibilen
gailurra: kalea








Hala eta guztiz ere, gure Herrian diren polizia guztiak gutxiegi ziren lanuzteak, manifestazioak eta langile, ikasle, erretiratu, langebetu eta dendarien haserrea lausotzeko

# Martxoak 10







TRESNA DEMOKOKRATIKOAGORIK EZ EGON ARREN, HERRITARREN ATXIKIMENDU LIBREA EZIN HOBETO IRUDIKATZEN DUEN BORROKABIDE ZUZENAGORIK EZ EGON ARREN, ITOTZE ESTRATEGIAN SAKONTZEKO GREBA EGUNAK HIZPIDE JARRAITU ZUEN IZATEN, BAI EDITORAILETAN, BAI -ZORITXARREZ- MADRILGO AUZITEGI NAZIONALEAN ERE.

Grande Marlaska epailearen esku-hartze berri batek segida eman zion Espainiako agintarien hautabide arriskutsuari. Bezperako greba zela eta, sei abertzale inputatu eta deklaratzera deitu zituen. Bere aburuz, "delitu ekintza" ugari izan ziren, eta deitutako grebaren zaku berean ETA-ren atentatuak sartu zituen. Era horretan, Eusko Jaurlaritzaren presio dialektikoak osatu zuen epaile faxistek behar duten argudiobidearen lojika: ETAren bonbak grebarekin lotuz, EAJren gidoia agerian geratu zen. Burumakur nahi zuen Ezker Abertzalea. Egia esanda, horrelako goizaldeetan desberdin hartzen dugu gosaria. Galduta edo izaten dugu begirada ispiluaren infinitoan hortzak garbitu bitartean. Horrelako goizaldeetan tenore laburrez artatzen dugu esperantza.

Horrekin batera, Ertzaintzak, Guardia Zibilak eta Polizia Nazionalak besoz beso sortutako saminaren mapa osoa hobeto ezagutu genuen, testigantza ezberdinei esker. Deustuko ikastolako 12 eta 16 urte bitarteko ikasleak kolpatu zituen Ertzaintzak, elkarretaratze bat burutzen ari zirelako.' Iruñeko neska gazte bati aldaka puskatu zioten, ia hiru metroko altuera zuen harresi batetik behera bultzatu baitzuen espainiar poliziak. Lizarra, Tafalla, Arrasate eta beste herri asko izan ziren polizia ezberdinen indarkeriaren lekuko zuzena. Guk ian ezik, beste inork ez zuen txàrretsi polizia jazarpena edota hainbat



## Ertzaintzak, Guardia Zibilak eta Polizia Nazionalak besoz beso sortutako saminaren mapa osoa hobeto ezagutu genuen, testigantza ezberdinei esker






## Hieroglifikoak daude gure herrietako kantoi guztietan. Izkinaren bueltan zer dagoen esaten digutenak

komunikabideren gezurrak.

Hieroglifikoak daude gure herrietako kantoi guztietan. Izkinaren bueltan zer dagoen esaten digutenak. Hala ere, irakurtzen ez dakienarentzat, pentsatzen ez duenarentzat, porrotaren gidoitik aldentzen ez direnentzat, hieroglifiko izango dira betiko. Inoiz ez gidaliburu edo iparrorratz.

Bestaldetik, nazio manifestazio berri baten bezperan geunden. Izan ere, Etxerat-ek Portugalete eta Santurtzi batuko zuen mobilizazio berria deitua baitzuen dagoeneko, agintariek sakabanaketa amaitzeko pausoak noiz emango duten esperoan egon beharrean, preso ziren bere senideak bizirik etxeratzeko behar beste lan egingo zutela garbi utzita.

Berriz ere, maitasuna izan zen deialdi honen motore nagusia. Hurkoekiko maitasunez ari garelarik, Igor eta Robertoren senideen sumindura ezin izkutatzekoa zen. "Gu manipulatuta?",... Maitasunez ari garelarik, euskal preso politikoek eta beren ahaideek alboan beti daukaten arnasa eta babes zintzoa norena den zalantzarik ez izanik itxi genuen eguna. Gu izateko edo izateagatik mina sentitu gaberik ■

# Martxoak 11

ETA BATZUETAN EURIA GOIAN BEHEAN ZEHARKATZEN DITUGU KALEAK. BUSTI EGINDA, EMOZIOEK HARTUTA, ESTIMU HANDITAN DITUGUN PERTSONEN ITZALAK XAXATURIK, HERRI HONETAN MAITASUN ERAKUSTALDI APARTAK IKUS DAITEZKE. ETA SENTIMENDU GUZTIEK BERE XARMA ETA MERITUA BADUTEN ERE, EUSKAL PRESO POLITIKOEN ALDEKOETAN, OSO BEREZIKI, AZAL BIZIAN EGOTEN DIRA.

Oso egun gogorrak igaro ostean, ahotsa kraskaturik eta amorrua golkoan, kalera ateratzeko gonbitea egin zigun Etxerat-ek. Preso eta iheslari politikoen senide eta lagunak biltzen dituen elkarteak ez zuen oharkabeki pasatzen utzi nahi Rober eta Igorren heriotzek eragindako hunkidura. Beste era batera esanik, herritar askok bihotzean gordeta zuen dolua askatu eta preso guztiak Euskal Herriratzeko nahi kolektiboari bide emateko apostua egin zuen.

"Orain eta bizirik". Maite ditugulako, etxean behar dute egon. Oso lelo ulergarriak, ezin lotuagoak abagunearekin, eta ekaitzahodei guztiei aurre egiteko behar besteko indarra ematen zigutenak. Izan ere, aspaldi honetan ikusi dugun zerurik estaliena eta beltzena buru gainean genuela abiatu baitzen Portugaleteko kanposantuko ate aurretik hasi eta Santurtziko plaza nagusian amaitu zen manifestazioa.

Hezurrak urtuta ere, oihuen oiartzunak ez ziren putzuetan trabatzen. Irristan eta guzti, trumilka hartu genuen itsasadarraren ertzea, jendez bete genuen garabioen etorbidea, Igor, Roberto eta bi estatuen kartzeletan dauden gizon-emakumeak Herri honen zainetan daudela aldarrikatzeko.

Bakardadeak jarri ohi gaitu bere sakontasunaren mugetan sarri. Erraza da euripeko




Irristan eta guzti, trumilka
hartu genuen itsasadarraren
ertzea, jendez bete genuen
garabioen etorbidea,
Igor, Roberto eta bi estatuen
kartzeletan dauden
gizon-emakumeak
Herri honen zainetan
daudela aldarrikatzeko






## Batik bat, maitasunez estali genuen minaren biluztasuna. Horrelaxe, betiko dirudiena ere amaitu egiten dela ikasiz, memoria progresiboa lantzen dugu. Sakabanaketa amaitu beharra dago

bihotzminaren haritik bakarrik sentitu, bizi eta -finean- halatan egotea, igande arratsaldeetako isiltasun-puntua bakarrizketa bihurturik. "Jendearen babesak eman digu indarra", esaten zuen Jose Luis Sainz-ek, Robertoren aita. Orografia ezaguna dugu elkartasunarena, eta eguraldi oldarkorraren haize-olatuak ilean eramanez, inguratu genituen gure presoen senideak. Batik bat, maitasunez estali genuen minaren biluztasuna. Horrelaxe, betiko dirudiena ere amaitu egiten dela ikasiz, memoria progresiboa lantzen dugu. Datorrena datorrela, sakabanaketa amaitu beharra dago.

Milaka eta milaka izan ginen larunbatean. Argazki hura eraman zuen etxera jendexaloak hurrengo goizean, ogia erosi eta egunkarietako goiburuak zer zioen ikusi ondoren. Aranjuez eta Cuencako kartzeletako patioetan, hormatxoriak arituko ziren, pauso txikian, ogi apurren bila. Gauzak eta hitza oso bestelakoak dira. Diferenteak dira ere bai letra eta ekintza. Beraz, zaila da oso egin genuena idaztea, ez bada, noski, oroimena garela gogoratzeko. Beti oroituko ditugula idazteko ■

# Martxoak 12-13



KURDISTANGO PEXMERGAK DATOZKIT GOGORA. "HERIOTZARI AURREZ AURRE BEGIRATZEN DIONA" ESAN NAHI DU, HITZEZ HITZ, GERRILARI KURDUAK IZENDATZEKO ERABILTZEN DEN PEXMERGA HITZAK. IGOR HIL ZUTENETIK IA BI ASTE JARRAIAN GENERAMATZAN HERIOTZARI BRANKA JARTZEN. BERE AURREAN BEGIAK KLISKATU GABE. ETA HARREZKERO, BEREZKO ETORRIA DUGU. "BEGIAK PARREZ PARREZ, BIHOTZA NEGARREZ" IKASI DUGULARIK, ERNEGUA IZATEN DA BEGIRADAREN PAUSALEKUA, DENBORAREN ORRATZAK ETETEN EZ BADIRA ERE.

Izan ere, errepresioaren makinariak ez zuen etenaldirik izan. Grande-Marlaska epailearen ekinbidez, Arnaldo Otegi, Juan Joxe Petrikorena, Juan Mari Olano, Pernando Barrena, Rafa Díez eta Arantza Zulueta inputatu gisa deklaratzera deituak zeuden, osteguneko greba egunaren harira.

Auzibide honetan greba eguna zigortu nahi zen. Euskal Herriak erakutsitako kuraia zigortu, eta erasoei erantzuteko lejitimotasuna auzipetu, horrela herritarrak otzandu eta askabidea oztopatuko liratekeelakoan. Kristala lurruntzea zuten helburu, bidea itxi eta mokadua kontrako eztarritik joan zedin baldintzak sortzea. Azken finean, Igor eta Rober-en lepotik jarri nahi izan ziguten uztarria. Nasaitu zuten korbatako korapiloa epaileek, uste zuten-eta Euskal Herriari heriotzari aurrez aurre begiratzen jarraitzea beste erremediorik ez zitzaiola geratuko.

Normaltasuna, horma zuriak, eguzkitako betaurreko beldurgarriak, Espainiar eta frantziar legeak betearaztea, mendekua, Lynch-en logika, Meliton Manzanas-en erregubetasuna, El Mundo egunkaria, Benedicto XVI trikornioz hornituta, Balzaren gezurrak, kanposantuak, beilate-



ADMINISTRACION DE JUSTICIA

**JUZGADO CENTRAL DE INSTRUCCIÓN**
**NÚMERO CINCO DE MADRID**
**AUDIENCIA NACIONAL**

**SUMARIO 35/02-M**
INTEGRACIÓN EN ORGANIZACIÓN TERRORISTA.

**AUTO**

Madrid, 16 de marzo de 2006.

**HECHOS**

**PRIMERO.-** En el día de la fecha se ha recibido declaración en calidad de imputado a Juan María OLANO OLANO.

Celebrada comparecencia del art. 505 de la L.E.Crim., con el resultado que obra en auto y del tenor literal siguiente:

*«Ante el MAGISTRADO-JUEZ de Instrucción y de mi, el Secretario Judicial, Fiscal y Letrado que ha asistido al imputado en la precedente declaración, así como el letrado de la acusación particular; comparece la persona arriba identificada, con el fin de celebrar la audiencia que establece el artículo 505 de la L.E.Cr.:*

*Por S.Sª se concede a la Asociación Victimas del Terrorismo, y se solicita el ingreso en prisión del Sr. Olano, por entender que es inductor de los hechos acontecidos en la jornada de 09.03.06. y por entender que ha entrado en la órbita de la estrategia de la organización ETA-BATASUNA-KAS, siendo evidente un riesgo de fuga ya que se encuentra imputado en otra causa y por la que hubo de ser extraditado para ponerle a disposición de la Justicia, teniendo en cuenta además que se produce aquí una reiteración delictiva y por todo ello, se solicita su ingreso en prisión.*

*Por el letrado de "Dignidad y Justicia", para solicita la prisión incondicional por un plazo de dos años del Sr. Olano, de los informes de la Guardia Civil y Ertzaintza, así como la conducta del imputado, revelan por un lado, su permanente vinculación a la organización BATASUNA, y con la que colabora. El Sr. Olano participa en acto de la citación organización ilegalizada. Ha intervenido una convocatoria de "jornada de lucha", siendo inductor de hechos delititos graves de naturaleza terrorista. Participa en homenajes a presos de ETA y como miembro o ex miembro de Batasuna, no puede desconocer el contenido del auto que ilegaliza y suspende de actividades a BATASUNA. Ha sido procesado y ha estado en prisión por otros delitos de*

1

**Nasaitu zuten korbatako korapiloa epaileek, uste zuten-eta Euskal Herriari heriotzari aurrez aurre begiratzen jarraitzea beste erremediorik ez zitzaiola geratuko**

giak, bazterrak nahastea, esne-berbetan aritzea, Confebask-en hitz-aspertuak, AVT, AHT edota TVE.

Sakabanaketa, zuzenbide estatua, Epaitegi Gorena, Grande-Marlaska, Lokarriren negozio mataza, 18/98 eta + amaigabea, zitazioak, fidantzak, isunak, Alto Control de la Guardia Civil, Aitor Elortza eta Iñaki Rike zerraldo, esku zuriak, zurikeria nonahi, Hirukoa eta Talantea, tortura hotsa, negu hotza, Protokoloa, heriotza.

Beste bi mendeetako laberintoan nahi gaituztelako bizkarreratzen zaio Ezker Abertzaleari heriotzarekin kartetan jokatzea. Bidegabea da gezurra beti hor egotea, zirkinik egin gabe, bateria guztiak guri zuzenduta. Eta hala ere, akorduaren akorduaz, bizitza dugu erronka. Ezker pareta kartzeletan, baina sakea gurea ■

# Martxoak 16



OLANO KARTZELAN ORDURAKO, PETRIKORENA ESPETXERATU ZUTEN OSTEGUNEAN, ETA EGUN GUTXI BATZUK BERANDUAGO OTEGIK HARTU ZUEN PORTU DESTINU BEREAN. BERMEAK ERE UGARI. EHUNKA MILA EUROKOAK, ALEGIA. DIRUDIENEZ, ESTORTSIO EKONOMIKOAK IZENORDE ASKO ONARTZEN DITU EUSKAL HERRITARRON POLTSIKOAK ASTINDU BEHAR DIRENEAN. IHES EGITEKO EDO BERRIRO DELITUAK EZ EGITEKO ARRISKUA DIRUZ MOTELDU DAITEKE AUZITEGI NAZIONALEKO LEIHATILETAN. NEGOZIOAK MILAKA KOSKA DITU.

Grande Marlaskaren autoek argudiobide oso berezia zeukaten. Izan ere, jarrera aktiboa egotzi zitzaien inputatuei greba egunaren antolatze eta sustatze lanetan. Politikariak, herri mugimenduko kideak eta sindikalistak izanda auzipetuak, ezer gutxi gehiago gehitu daiteke. Edozein marko demokratikotan ekinbide normaltzat eta beren funtzio esparruetan sartzen diren eginkizunak bultzatzea izan ziren kartzelaratzeko motiboak.

Greba itxurakoa edota ustezko greba izan zela aho askotatik atera bazen ere, Confebask, Jaurlaritza, UGT-CCOO, PNV eta beste sektorek ez zuten ahoa ireki zitazio eta espetxeratze aginduak jakitera emateakoan. Soto del Real-eko bidea hartzea puxika ustutzea bezain ohikoa dela ikusirik, parte meteorolojikoaren zer-nolakoak bezala tratatu ziren salbuespeneko erabakiak. Euskal Herriak, ordea, oso modu ezberdinean hartu zuen erabakia, eta erantzun askotarikoa prestatzeari ekin zion.

# PNV - ERTZAINTZA - EiTB

## UTZI PAKEAN EUSKAL HERRIA



"LA FAMILIA DE IGOR ANGULO HA REALIZADO LOS ACTOS QUE HA QUERIDO"
MIREN AZKARATE (PNV)



"LOS FAMILIARES DE IGOR ANGULO ESTAN MANIPULADOS"
JAVIER BALZA (PNV)



"LA ERTZAINTZA ACTUO DE FORMA PROFESIONAL"
IÑIGO URKULLU (PNV)



"EL PNV APOYA LA ACTUACION DE LA ERTZAINTZA"
JOSU JON IMAZ (PNV)



"YO CUMPLO CON MI TRABAJO Y CON LA LEY"
ERTZAINTZA



"BLA, BLA, BLA, BLA, BLA, BLA, BLA, BLA,..."
EiTB

**Ocupación policial, represión salvaje, prohibiciones, controles de carretera e identidad, humillaciones, agresiones, amenazas, heridos,... Todo esto y más ocurrió el pasado 4 de Marzo en Santurtzi de la mano de PNV-EAJ y su policía política, Ertzaintza.**



**ERREPRESIOA EZ DA BIDEA**





## Soto del Real-eko bidea hartzea puxika ustutzea bezain ohikoa dela ikusirik, parte meteorolojikoaren zer-nolakoak bezala tratatu ziren salbuespeneko erabakiak

Manifestazioak, adierazpenak, indar metaketa eta deialdi zabalak izan ziren prozesua eta auziperatuak babesteko berehalako neurriak, presoen aldeko eta sakabanaketa politikaren kontrako konpromisoa azaltzeagatik jasaten ari zen eraso bortzitzari harresi gaindiezina eraikitzeko.

Beharbada, sekula ez zen Igor eta Rober-en burutik pasatuko beren desagertzea halako lurrikara politiko eta soziala eragin zezakeenik. Noizbait hainbeste enerjia askatu eta giharrak tenkatuko zituenik. Baina hala izan zen. Derroten umilaziora inoiz ohitu ez den Herria da gurea, eta harroa da memoria. Dispertsioak gaur arte hil dituen azken borrokalarien hilotz bidean marraztu ziren Euskal Herriaren zainak eta orbainak. Zorigaiztoko mapa hartatik, maitasun zantzuak erreskatatu nahi izan ditugu orri hauetan. Koordenada horietan eraikiko baitugu etorkizuna.

Nekez tronpatzen dira negarra eta hasperena. Ez dira txolinen makuluak.

Otsaila eta martxoa bitartean lezio berria ikasi genuen: zuribeltzeko fotolitoetatik ateratzen direla ortzadarraren kolore guztiak. Kronika latza idaz zitekeen, eta erresistentzia kronika eskaini nahi izan dugu. Asfaltoaren zirrikituetan eta kale kantoietako ertz lakarretan itxaropena eta bizitza erregaia aurkitu zituztenei ■

# Juan Mari OLANO

## “Borrokak sortu ditu aukerak, eta soilik borrokaz egikarituko ditugu bidean eroritako guztien ametsak”

ASKATASUNEKO NAZIO KOORDINATZAILEAK URTE ASKOTXO DARAMATZA AMNISTIAREN ALDEKO MUGIMENDUAREN EKINBIDEA BULTZATUZ. 2006KO MARTXOAN KARTZELARA ERAMAN ZUTEN PRESOEN ALDEKO MOBILIZAZIOAK DEITZEA DELITUA ZELA ERABAKI OSTEAN. ONDOKO LERROTAN EGIN DIGU EGUN GOGOR HORIEN GAINEKO BERE IRAKURKETA. IRAKURKETA ETA AURRERA BEGIRAKO ERRONKEN GARRANTZIA ERE.






**Oihane Errazkin hil zenean kartzelan zeunden. Geroztik, Kotto Altzuguren, Igor Angulo eta Roberto Sainz euskal presoen heriotzak astindu du Euskal Herria. Espetxetik, nolatan bizitzen dira halako gertaerak?**

Oihane joan zitzaigunean espetxean nengoen bai, eta gorputzaren zati bat mutilatu balizute bezala sentitzen zara. Inpotentzia ikaragarriaz gain, amorrua eta bazter guztiak kiskaltzeko gogoak hartzen zaitu. Espetxeak eragin anitzak ditu presoarengan, eta aldizka, heriotza ere eragin dezake. Kotto joan zitzaigunean aldiz, espetxetik atera berria nintzen eta kolpe oso gogorra izan zen. Gainera, Navalcarneron modulu berdinean egon ginen biok eta anai hunkigarri bat zen niretzat. Lehenengo aldiz atxilotu zutenean, tortura

latzak jasan zituen espetxeratu aurretik, eta baldintzapeko askatasunean zegoelarik, zigorra betetzeko zitazio bat helarazi beharrean, berriro ere atxilotu egin zuten eta ezin izan zuen gainditu zama hori guztia. Hori da estatuen krudelkeriaren adierazle esanguratsu bat. Igor eta Baruren erailketa salatzeko, greba orokorra deitu genuen Ezkerraldean eta borroka eta lanuzteak Euskal Herri osoan. Horren ondorioz, Arnaldo Otegi, Juan Joxe Petrikorena eta ni neu espetxeratu gintuzten. Euskal Herriak eta bereziki Ezkerraldeak eman zuen erantzun indartsu eta ederrarekiko estatuaren mendeku politikoa, gu espetxeratzea izan zen. Hala ere horrek ez dio axola handirik, Igor eta Baruren heriotza da itzulbiderik ez duen drama. Azpimarratzekoa da, senitartekoek erakutsi zuten duintasuna. Milaka herritarren garunean betirako itsatsiak geratuko diren irudiak eskaini zizkiguten.





**Amnistiaren aldeko Mugimenduko militante historikoa zara. Urteak joan urteak etorri, presoak eta iheslariak, haien eskubideak izan duzue langai. Bere sorreratik 30 urte igaro diren honetan, Amnistia lortzeko bidean zertan egin du aurrera mugimenduak?**

AAMak, ibilbide aberats eta oparoa biltzen du bere baitan. Milaka herritarren ahaleginaren emaitza da AAMa. Preso eta iheslarien senitartekoak dira horren guztiaren osagai garrantzitsuena. Asko eman digu

senitartekoekin eginiko ibilbideak, eta esker oneko gara beraiekiko.Herrietako Komiteetatik lan egiten duten gizon eta emakume boluntarioen eguneroko esfortzua da AAMaren oinarririk sendoena. Euskal jendartearen aldarri eta elkartasun iturri agortezinari bide emateko tresna eraginkorra izatea da AAMaren zeregina. Gure ustez, amnistiaren alde, errepresioa eta torturaren aurka, Gatazkaren Konponbideari begira eta herritarren elkartasun oparoa bideratzeko Euskal Herriko erreferentzia politiko garrantzitsua da Askatasuna eta AAM osoa. Horretan egin dugu aurrera.

**Tartean, ilegalizazioak, auzipetzeak eta kartzeladiak,...**

Amnistiaren aldeko Batzordeak eta Askatasuna ere, legez kanpo utzi zituzten bai, beraz gure jarduerarako oztopo bat gehiago suposatu zuen eta du, baina herritarren konpromisoz, harresi guztiak gainditzen dira. Askatasunako militanteon helburua, ez da geure espetxeratzeak ekiditea, baizik eta preso eta iheslari guztiak etxeratzea. Horretan ari gara eta ariko gara, nahiz eta tarteka espetxetik pasatzea suposatu. Amnistiaren alde borrokatzeagatik espetxealditxoren bat pasatzeko prest ez dagoen herriak, ez du inolako etorkizunik, beraz preso eta iheslariekin batera, Amnistia lortu arte!

**Estatu bien estratejiak euskal preso politikoak ditu jopuntuan. Mendekua, gorrotoa, kalkulu politikoa,... Zerk azaltzen du hobekien etengabeko presio hori?**

Besteak beste, Joxe Mari Sagardui "Gatza ", Iñaki de Juana eta Jon Agirre Agirianoren kasuek oso modu nabarmenean erakusten dute zuk diozuna. Suarezen gobernutik hasi eta ondorengo guztiek, euskal preso politikoak erabili dituzte mozkin politikoak eskuratzeko. Garaikoetxea, Ardanza eta Ibarretxeren gobernuek berriz, eten gabe kolaboratu dute Espetxe

**Euskal jendartearen aldarri eta elkartasun iturri agortezinari bide emateko tresna eraginkorra izatea da AAMaren zeregina**

Politika horiei guztiei ezinbestekoa zuen babes politikoa eskainiz. Urralburu, Alli eta Sanz jaunei buruz, ez dago gauza handirik argitu beharrik ere. Azken hamarkada, Frantziako gobernuek ere izugarrizko urratsak eman dituzte presoen erabilpenean. Zertan oinarritzen den erabilpen hori? Bada, eskubideen urraketa iraunkorrean, beraz giza sufrimendua eraginez gauzatzen dute Euskal Herri osoarekiko xantaia politikoa.




Egun, 590 preso daude bi estatuetako 79 espetxetan sakabanaturik. Horietatik 13 soilik daude Euskal Herriko espetxeetan. Zazpi preso, larriki gaixoturik daude eta krudelkeria itzela da horiek ez askatzea. 590tik 135 presok, zigor osoa bete duten arren, oraindik ere espetxean mantentzen dituzte, zigorra luzarazteko trikimailu juridiko berriak asmatuz. Franco hil zen egunean sartu ninduten preso lehen aldikoz, eta ziurta dezaket, orduango espetxe politika baino askoz ere bortitzagoa dela gaur egunekoa. Bi estatuek sintonia osoan daramaten espetxe Politika horrek, jadanik 22 presoen bizia eraman du betirako eta 16 senitarteko eta lagunena ere bai, errusiar erruleta den sakabanaketaren errepideetan.



**Eta une politiko berezi honetan? Jendarte mailan aukera paregabea dugula da ikuspegi nagusia. Nolatan pasatu itxaropenetik urrats praktiko eta eraginkorretara?**

Bai itxaropena badago, baina itxaropenak, inspirazioak bezalaxe lanean harrapatzen bazaitu, ondo, baina bestela ez du ezertarako balio. Parisek eta Madrilek ez digute ezer oparituko inoiz, beraz Euskal Herriak lortzen ahal duena, garatzen duen konpromiso eta borrokaren araberakoa izango da. Lehenik, eragile guztiei irekia izango den Mahaia osatu behar da. Mahai horretan, Gatazkaren Konponbidea ahalbideratuko duen Akordio Politikoa eta trantsizioa adostu behar da, beraz Lurraldetasuna eta Autodeterminazio Eskubidea jaso behar ditu derrigorrean eta Euskal Herritarrek

baieztatu behar dute ondoren. Prozesu hori garatzeko ordea, derrigorrezkoa da baldintza demokratiko minimoak izatea, beraz errepresio politiko oro desagertu behar gure Herrian. Ilegalizazioak, atxiloketa eta torturak, Espetxe Politika, Entzutegi Nazionalaren eskuhartze etengabekoak edota manifestazioen debekuak desagertu behar dira gure bizitza sozial eta politikotik. Euskal Herriak du Hitza eta Erabakia, baina Askatasunez erabaki behar du. Horregatik nioen lanean harrapatu behar zaituela, zeren eta Herritarren inplikazio iraunkorrik gabe, ez dago aurrera egiterik. Gatazkaren Konponbidean guztiok gara giltza, beraz guztiok eta bakoitzak daukagu erantzukizun pertsonala ere.

**Herritarren inplikazio iraunkorrik gabe, ez dago aurrera egiterik. Gatazkaren Konponbidean guztiok gara giltza, beraz guztiok eta bakoitzak daukagu erantzukizun pertsonala ere**

**Presoak, iheslariak eta gainontzeko errepresaliatuak ontzi berean daude. Gatazkaren ondorioa izanik, posible al da haien ekarpena bideratzea, hain zuzen, gatazka gaindituko duen prozesu politiko baten markora?**
Posible, beharrezkoa, logikoa eta derrigorrezkoa ere bada. Euskal preso eta iheslari politikoak, Kolektibo gisa antolatu diren heinean, Prozesu Demokratikoarekiko eta Gatazkaren Konponbidearekiko ere, nortasun eta funtzio propio eta ordezka ezina duen Eragile Politikoa osatzen dute. Prozesuak eta Konponbideak, guztien beharra du, baita preso eta iheslariena ere. Ihesean edota espetxean ditugun militante abertzale eta ezkertiar herrikideak, inor baino konprometituago daude Prozesuarekin eta Konponbidearekin, beraz zer arrazoi egon daiteke haien ekarpenari muzin egiteko? Gatazka luzatu nahi duenari soilik interesatzen zaio hori, eta aldiz, Gatazkaren Konponbidearen alde dihardúen orok bultzatu behar luke preso eta iheslarien parte-hartzea.

**Horretarako, ordea, gutxieneko baldintzak bete beharko dira. Egungo espetxe politikak edota legediaren ezarpenak harresi gaindiezina dirudite**
Egun indarrean daukaten Espetxe Politikak eta euskal



presoen eta iheslarien natura politikoa ukatzeak, Frantziar eta Espainiar Estatuek gure Herriaren aurka garatu duten gerra estrategiari erantzuten dio. Beraz Gatazkaren Konponbidea ekarriko duen Prozesu Demokratikoa indarrean jarri nahi bada, lehenengo, dagokien Estatus Politikoa aitortu behar zaie, eta Euskal Herrira ekarri dagozkien eskubide guztien jabe. Preso eta Iheslarien Kolektiboek, askatasun osoa izan behar lukete beraiekin harreman politikoak izan nahi dituzten Eragileekin mintzatu ahal izateko.



**Aurtengo lehen hilabeteak ahazteko zailak izan ziren. Otsailean eta martxoan, astebeteko aldearekin, Igor eta Roberto galdu genituen. Nola gogoratzen dituzu egun horiek?**
Lehen galderan erantzun dizut zertxobait, eta bai, sentimendu gazi-gozoak ditut nire baitan. Alde batetik, Igor eta Robertoren heriotzaren mina, erraiak urratzen dituen mina. Bestetik berriz, Euskal Herriak eta bereziki Ezkerraldeak emaniko erantzun duin, eder eta indartsuarekiko poza eta harrotasuna.
**Eredugarria izan zen Ezkerraldeak, Euskal Herriak, eman zuen erantzuna. Inoiz ahaztuko ez diren irudiak daude denon memorian. Bakarren bat azpimarratzearren, zein geratu zen zure begi-**

ninietan?
Igor eta Robertoren familiek erakutsiriko kategoria humanoa eta politikoa. Horrek ez du preziorik!

**Martxoaren 15an, beste abertzaleekin batera, espetxeratu zintuen Grande Marlaskak, greba orokorrean jazotako istiluen ardura leporatuta. Zer lortu nahi zuten, zure ustez, erabaki harekin?**
Euskal Herritarren atentzioa desbideratzea bilatzen zuten espetxeratze haiekin, alegia; Igor eta Robertorekin burutu zituzten Estatu Krimenak ezkutatu nahi zituzten, eta baita Euskal Herriak emaniko erantzuna ere. Orrialdea pasatzeko sistema zahar bat baino ez da hori. Komeni ez zaizun berri batek aktualitatea okupatzen badu, hori tapatuko duen beste berri bat sortu eta kitto, horixe da egin zutena! Mendeku politiko higuingarri bat ere izan zen. Dena den, Soto del Realeko presoak ikusteko aukera izan nuen bederen, bestela ez baitidate baimenik ematen !

**Bukatzeko, Baru eta Igor gogoan, zer mezu helaraziko zeniokeen gure Herriari jokoan horrenbeste dugun abagune honetan?**
Historia guk geuk egin behar dugula. Euskal Herritar bakoitzari, bizi ditugun garai hauetako egiazko protagonista izateko esango nioke. Geure Herriaren oraina eta geroari buruzko erabakiak, garrantzitsuegiak direla soilik alderdi politikoen esku uzteko. Denok daukagu zerbait esateko, egiteko, proposatzeko, konpartitzeko, adosteko, garatzeko,...
Ezker Abertzalearengan konfiantza izateko eskatuko nioke, baina horrekin batera, konpromisoak hartzeko eta borrokatzeko, zeren eta Prozesu hau ezer izatekotan, borroka Prozesu bat izan behar duela edota hutsean geratuko da. Borrokak sortu ditu aukerak, eta soilik borrokaz egikarituko ditugu bidean eroritako guztien ametsak. Gezurra badirudi ere, hemendik aurrerakoa izango da zailena. Aurrera bolie! ■

**Ezker Abertzalearengan konfiantza izateko eskatuko nioke, baina horrekin batera, konpromisoak hartzeko eta borrokatzeko, zeren eta Prozesu hau ezer izatekotan, borroka Prozesu bat izan behar duela edota hutsean geratuko da**

